# LEIOAKO EUSKARAREN GRAMATIKAZ

Iñaki Gaminde

LEIOAKO UDALAREN LAGUNTZAZ

# AURKIBIDEA

# 0. SARRERA.

Lantxo honetan Leioan erabiltzen den euskararen gramatikarekiko hurbilpena egiten ahalegintzen gara. Bertako morfologia eta sintaxiaren esaldi ereduak aurkezten ditugu, hainbat alderdi ilunetan azalpenak irudikatu ere egin ditugu, beti ere, ahal gainoan. Hemen aurkezten diren datu guztiak geuk jasokoak dira, honek ez du esan gura aukera eta erabilera gehiago ezin egon daitekeenik.

Datuak jasotzeko sistema bi erabiltzen izan dugu; alde batetik, itzulpenak, hots, esaldiak itzul eraztea, guk erdaraz esanda eurek euskaratzeko, eta beste aldetik testo libreak. Lehen sistema horrek badu, jakina, akats nabarmena ordenari dagokionez, izan ere, erdararen eraginez lekukoek itzulpen literala egiten izan dute erdal ordenari atxekita.

Leioako euskara Bonaparteren banaketaren arabera Plentziako barietatearen barruan kokatzen da, ondoko mapa honetan ikus daitekeen legez.




1. Mapa.: Leioaren kokaera bizkaieraren barietateen arabera.








2. Mapa.: Plentziako barietatea, Leioa eta inguruko herriak.

Lantxo hau burutu ahal izateko izan ditugun lekukoak ondoren aipatzen direnak izan dira, beraientzat gure eskerrik beroenak:

Carmen Azkue, 64 urte
Teresa Atxalandabaso, 60 urte
Petra Learra, 73 urte
Benigno Gana, 76 urte
Nati Billalabeiti, 73 urte

Leioako datu gramatikalak eman ez bazizkigun ere, eranskinean agertzen diren gauza guztiak berari zor dizkiogunez gero, ezin utz dezakegu aipatu barik:

- Alicia Elordui

Lanari ekin baino lehen zerozer esan beharra dago traskribatzeko erabili dugun sistemari buruz. Transkripzioak ez bide dira sano zehatzak, izan ere, gure helburua ez da bertako fonetika aztertzea morfosintaxia baino; euskara estandarraren sistema bera erabiltzen dugula esan dezakegu, bertako ebakeraren berezitasunen berri eman ahal izateko aldaketa txiki batzu egin ditugu, hona hemen:

| | | |
|---|---|---|
| "y" | = | [y] |
| "ñ" | = | n] |
| "ll" | = | l] |
| "j" | = | [x] |





# 1. ADJETIBOA.

## 1.1. ADJETIBOAREN KOKAGUNEA.

Adjetiboaren kokagunea izenaren ostean dugu, gainerako barietateetan arrunta den legez, hona hemen adibide batzu:

- ikus du etze gorri
  (ikusi dugu etxe gorria)

- etor da mutil lodi
  (etorri da mutil lodia)

- neska gaste yon da
  (neska gaztea joan da)

- erosi dot alkondara sabala
  (erosi dut alkondara zabala)

**-DUN** atzizkiaren bidez egiten diren adjetiboei dagokienez kokagune berean agertzen direla esan dezakegu, adibidez:

- mutil biserdune etor da
  (mutil bizarduna etorri da)

- gison ergaldune yon da (Udondo)
  (gizon erdalduna joan da)

- etor da andra euskaldun bet
  (etorri da andere euskaldun bat)

-**TAR** atzizkiaren bidez egiten diren adjetiboak ere kokagune berean agertzen zaizkigu, adibidez:

- neska gernikar bat esetu dot
  (neska gernikar bat ezagutu dut)

- gison biskaitarra etor da
  (gizon bizkaitarra etorri da)

Atzizki honen funtzionamendua ikusi ahal izateko hona hemen Leioa inguruko herriei dagozkien jentilizioak:

| | |
|---|---|
| leyoatarra | berangostarra |
| getxotarrak | gatikostarrak |
| laukistarrak | sopelastarrak |
| erandiotarrak | barrikostarrak |
| urdulistarrak | bilbostarrak |

# 1.2. ADJETIBOAREN ALDAGARRIAK.

## 1.2.1. -AGO

- ori da andiao
  (hori da handiagoa)

- ori da txikerrao
  (hori da txikiagoa)





### 1.2.1.1. -AGOren bidez egineko zenbait lokuzio:

a) GERORAO... -AO

- ori gerorao andiao da
  (hori geroago handiagoa da)

- ori gerorao sarrao da
  (hori geroago zaharragoa da)

b) ASKOS... -AO

- ori askos da fasilao
  (hori askoz da errazagoa)

- ori da askos gatxao
  (hori da askoz gatxagoa)

- ta bear gitxiao askos bere inte
  (eta behar gutxiago askoz ere eginda)

c) SENBET...-AO

- senbet gorao egon obeto entzuten da
  (zenbat gorago egon hobeto entzuten da)

- senbet parajeao egon obeto ikusten da
  (zenbat hurbilago egon hobeto ikusten da)

- senbet parajeao obeto
  (zenbat hurbilago hobeto)

- senbet gogorrao txarrao
  (zenbat gogorrago txarrago)

- senbet eta andiao txarrao
  (zenbat eta handiagoa txarrago)

Udondo auzoan "senbet" barik "senbest" erabiltzen da, adibidez:

- senbest eta parajeao egon obeto ikusten da
  (zenbat eta hurbilago egon hobeto ikusten da)

- senbest eta giao esan txarrao da
  (zenbat eta gehiago esan txarragoa da)

Beste lekuko batzuk "senbet" erabili beharrean egitura berberau adierazteko "gerorao" erabiltzen izan dute, adibidez:

- gerorao eta altuao paraten basara obeto ikusiko su
  (geroago eta altuago paratzen bazara hobeto ikusiko duzu)

- gerorao parajeao basaos obeto entzungo su
  (geroago hurbilago bazaude hobeto entzungo duzu)

- gerorao txikerrao obeto
  (geroago txikiagoa hobeto)

- gerorao andiao txarrao
  (geroago handiagoa txarragoa)

Era honetako egituretan "-AGO" atzizkia aditzari berari erants dakioke, adibidez:





- gerorao ta gorao onao obeto ikusten da
  (geroago eta gorago egonago hobeto ikusten da)

- gerorao ta parajeao onao obeto entzuten da
  (geroago eta hurbilago egonago hobeto entzuten da)

- gerorao ta giao ekarriao obeto
  (geroago eta gehiago ekarriago hobeto)

## 1.2.2. -EGI

- ori da andiegi
  (hori da handiegia)

- ori da txikerregi
  (hori da txikiegia)

Kantitate alorrean "lar" erabiltzen da, hona hemen adibide batzu:

a) Izenik gabe:

- lar ekar deude
  (lar ekarri dute)

- orrek deko lar
  (horrek dauka lar)

- lar dok ori
  (lar duk hori)

- lar yaok emen
  (lar diagok hemen)

b) Izenarekin batera:

- bero lar iten deu
  (bero lar egiten du)

- okela lar yan deude
  (okela lar jan dute)

- eron deude piper lar
  (eroan dute pipar lar)

- emen kea lar dao
  (hemen ke lar dao)

- ure lar edan deue
  (ur lar edan dute)

- porru lar ekar deude
  (porru lar ekarri dute)

### 1.2.3. -EN

Gehienetan graduatzaile hau erabilkeran aurreko izenari -RIK eransten zaio, adibidez:

- ori da mutilik gasteena
  (hori da mutilik gazteena)





- ori da andrarik sarrena
  (hori da andrerik zaharrena)

- ori da neskarik lodiena baserriko
  (hori da neskarik lodiena baserrikoa)

- mendirik altuena Gorbea da
  (mendirik altuena Gorbea da)

- errekarik andiena Nerbion da
  (errekarik handiena Nerbioi da)

Behin baino ez zaigu agertu izena -RIK atzizkia erabili barik:

- ori da seńe gasteena etzen
  (hori da seina gazteena etxean)

Multzo batetik elementu bat atera behar izatekotan -TARIK atzizkia eransten zaio izenari, adibidez:

- mutiletarik sarrena au da
  (mutiletarik zaharrena hau da)

- neskatarik gasteena esta etorri
  (nesketarik gazteena ez da etorri)

### 1.2.4. ON eta TXAR-en graduatzaileak.

| | | | |
|---|---|---|---|
| on | obe | onegi | onena |
| txar | txarrao | txarregi | txarrena |

- ori da obe
  (hori da hobea)

- ori da txarrao
  (hori da txarragoa)

- ori onegi da
  (hori onegia da)

- ori txarregi da
  (hori txarregia da)

- ori da onena
  (hori da onena)

- ori da daonik txarrena
  (hori da dagoenik txarrena)

### 1.2.5. ONDO eta TXARTO-ren graduatzaileak:

| | | | |
|---|---|---|---|
| ondo | obeto | (lar) ondoegi | ondoen |
| txarto | txarrao | txartoegi | txartoen |

- olan dao obeto
  (holan dago hobeto)

- olan dao txarrao
  (holan dago txarrago)





- in deude lar ondoegi
  (egin duten lar ondoegi)

- ori dao txartoegi
  (hori dago txartoegi)

- ondoen daona autxe da
  (ondoen dagoena hauxe da)

- txartoen daona sure da
  (txartoen dagoena zurea da)

## 1.3. HAIN

- ni enas ain lodi
  (ni ez naiz hain lodia)

- su esara ain altu
  (zu ez zara hain altua)

- ori esta ain argala
  (hori ez da hain argala)

Kantitate alorrean, ostera, "ainbeste" baino ez da erabiltzen, adibidez:

- nik es dekot ainbeste diru
  ( nik ez daukat hainbeste diru)

- suk es dekosu ainbeste urte
  (zuk ez daukazu hainbeste urte)

- orrek es deko ainbeste bei
  (horrek ez dauka hainbeste behi)

## 1.4. NAIKO

Beroni dagokionez bai "naiko" bai "bastante" biak erabiltzen direla esan dezakegu:

### a) Aldagarri gisa:

- ori da bastante andi
  (hori da nahiko handia)

- ori da bastante txikerra
  (hori da nahiko txikia)

- ori da mutile bastante andi
  (hori da mutila nahiko handia)

- ori da andra bastante gastetxu
  (hori da andre nahiko gaztetxoa)

- etor da andra bat naiko edadeko
  (etorri da andre bat nahiko edadekoa)

- etor da neska bat naiko gaste
  (etorri da neska bat nahiko gaztea)

### b) Aditzondo eta zenbatzaile gisa:

- naiko da
  (nahikoa da)





- naiko dao
  (nahikoa dago)

- orrek daki bastante
  (horrek daki nahiko)

- etor dire naiko
  (etorri dira nahiko)

- emen naiko dao ardirik
  (hemen nahiko dago ardirik)

- ekar deituse naiko kinpulla
  (ekarri dituzte nahiko kinpula)

- ori erositeko nik ekar dot bastante diru
  (hori erosteko nik ekarri dut nahiko diru)

- au bearra akabateko naiko deku denporarik
  (behar hau amaitzeko nahiko daukagu denborarik)

## 1.5. APUR BET

Beste barietate batzutan erabiltzen den "samar"en ordez "apur bet" erabiltzen da, adibidez:

- ori dao apur bet bero
  (hori dago bero samar)

- ori dao apur bet hotz
  (hori dago hotz samar)

- ori da apur bet lodi
  (hori da lodi samarra)

- ori da apur bet txikerra
  (hori da txiki samarra)

Beste barietate batzutan ere gertatzen den legez "samar"en ordez -TXU atzizkia erabiltzen da, beronen erabilera sano bakana den arren; hona hemen adibide bat:

- etor da andra bat ya edade anditxu dekona
  (etorri da andre bat ja edade handitxua daukana)

## 1.6. SANO

- ori sano andi da
  (hori sano handia da)

- ori sano da gaste
  (hori sano da gaztea)

- sano polite da
  (sano polita da)

- sano ondo da
  (sano ondo dago)

"sano" hau "asko"ren ordez erabiltzen da aditzaren ekintza ezin konta daitekeenean, adibidez:





- euri in yok sano
  (euri egin dik sano)

- sano argaldu nok
  (sano argaldu nauk)

- formaldu da sano
  (zintzotu da sano)

- sano asi da erri
  (sano hazi da herria)

- sano gusta dat
  (sano gustatu zait)

- sano yan ber da gero!
  (sano jan behar da gero!)

- umek sano yan deu[1]
  (umeak sano jan du)

- sabaldu ago sano
  (zabaldu ahoa sano)

- emon ingotzut sano[2]
  (eman egingo dizut sano)

1 Kasu honetan sano honek erdal "fuerte" adierazten du.

2 Esaldi honen testoingurua kontutan hartuta, hots, ume bati mehatxu egiteko, sano-k erdal "fuerte" adierazten duela esan dezakegu.

Gorengo maila adierazteko "itzel" erabiltzen da, adibidez:

- ganadu itzel gustaten dako oneri
  (ganadua itzel gustatzen zaio honi)

Beste kasu batzutan, adjetiboarekin, "sano" erabili beharrean adjetiboa bera errepikatu egiten da, adibidez:

- ta lodi lodi in
  (eta lodi lodi egin)

## 1.7. DUSTIS

Berau gorengo maila adierazteko erabiltzen da, adibidez:

- ori dustis da inusente
  (hori guztiz da ergela)

- ori da dustis suri
  (hori da guztiz zuria)

## 1.8. ATRIBUTOA

Atributoaren erabilerari dagokionez, berau adjetiboa denean, eskuarki bereiztu egiten dugu dela erabilera hori izan aditzarekin dela egon aditzarekin, izan ere, mugatzailea aitatutako aditz horien arabera agertzen da. Leioan gauza bera egin beharko genuke, bokalez amaituko izenekin desberdintasunik agerian ikusten ez badugu ere, bestelakoa izaten da kontsonantez amaitukoekin.





### a) IZAN aditzarekin:

Kasu honetan erabiltzen den galdekaria "selao" dugu, adibidez:

- selao da sure erri?
  (zelakoa da zure herria?)

- selao bason egon sara?
  (zelako basoan egon zara?)

Hona hemen beroni legozkiokeen erantzun batzu:

- ume da andi
  (umea da handia)

- erri da andi
  (herria da handia)

- ori esta ain argala
  (hori ez da hain argala)

### b) EGON aditzarekin:

Aditz honekin erabiltzen den galdekaria "zelan" dugu, adibidez:

- selan dao beskari?
  (zelan dago bazkaria?)

Hona hemen erantzun batzu:

- erreke dao loi
  (erreka dago lohi)

- beskari dao gasi
  (bazkaria dago gazi)

- au mingotz dao
  (hau mingots dago)

Atributoaren funtzioa izen batek ere bete dezake; honelako kasuetan izen hori mugatzaile barik agertzen zaigu, adibidez:

- ori dao errin abade
  (hori dago herrian abade)

- nire anaje dao pastore Ameriketan
  (nire anaia dago artzain Ameriketan)

- ori bota deude kriedu
  (hori bota dute morroi)

- ori yon da maestre Bilbora
  (hori joan da maistra Bilbora)





# 2. DETERMINANTEAK.

## 2.1. MUGATZAILEA

Ø A AK OK

Hona hemen mugatzaileak eranstean ematen diren aldaera morfonologikoak bokal desberdinen arabera:

| Mug. | Sing. | Plu. |
|---|---|---|
| alaba | alabe | alabak |
| seme | seme | semek |
| idi | idi | idik |
| asto | asto | astok |
| katu | katu | katuk |

Kontsonantez amaitukoekin, kontsonante horren aurrean "u" edo "i" egon ezik, mugatzailea osorik, hots, asimilatu barik agertzen zaigu, adibidez:

| Mug. | Sing. | Plu. |
|---|---|---|
| gison | gisona | gisonak |

Plural hurbila gero eta gutxiagotan erabiltzen da, hala ere, hona hemen adibide batzu:

- onek gausok dabiltes eskuarten
  (hauek gauzok darabiltzat esku artean)

- yongo gara biok batera
  (joango gara biok batera)

- gu gare danok emekok
  (gu gara denok hemengoak)

## 2.1.1. Mugagabearen aditzarekiko komunztadura.

Mugagabea egitean kasu gehienetan aditzari plurala ezartzen zaio, beti horrela jazotzen ez den arren, hona hemen adibide batzu:

**Singularra:**

- entzun deue gausa gitxi
  (entzun dute gauza gutxi)

- nik estekot ainbeste urte
  (nik ez daukat hainbeste urte)

**Plurala:**

- orrek estekos ainbeste ardi
  (horrek ez dauzka hainbeste ardi)

- senbet urte dekosus?
  (zenbat urte dauzkazu?)

- senbet piper yan dosus?
  (zenbat pipar jan dituzu?)

- senbet ume etor dires?
  (zenbat ume etorri dira?)

- senbet etze daos errin?
  (zenbat etxe daude herrian?)





- senbet ollasko emon dotzeas nik?
  (zenbat oilasko eman dizkiot nik?)

- senbet porru ekar dosus?
  (zenbat porru ekarri dituzu?)

- senbet madari emon dotzus orrek?
  (zenbat madari eman dizkizu horrek?)

- etor dire ume bi
  (etorri dira ume bi)

- iru bei ekar doas
  (hiru behi ekarri ditut)

- bota deituese bost ume
  (bota dituzte bost ume)

- etze bi saldu deituese
  (etxe bi saldu dituzte)

- suk malluki asko yan dosus
  (zuk marrubi asko jan dituzu)

- intxur gitxi ekar doas
  (intxaur gutxi ekarri ditut)

## 2.1.2. Mugagabe bereziak

Gauza jakina da zenbait berbarekin kasu gehienetan mugagabea egiten duna, adibidez:

- berotan imin dot
  (berotan ipini dut)

- orrek egon dire euskiten
  (horiek egon dira eguzkitan)

- ori yausi da uretara
  (hori jausi da uretara)

- yon dire eskerretara
  (joan dira ezkerretara)

- ume iserditen dao
  (umea izerditan dago)

- yon dire eskerretako alderdire
  (joan dira ezkerretako alderdira)

- oriotan eta koipetan bere bai
  (oliotan eta koipetan ere bai)

Leioan bizkaieraren beste eremu askotan jasotzen den legez "surtan" eta "sutan" bereiztu egiten dira, adibidez:

- amak imin deu lapiko surten
  (amak ipini du lapikoa surtan)

- baso dao suten
  (basoa dago sutan)

"bake", "lora" eta "mesa" berbekin ez da berdin egiten, adibidez:

- sagarrak daos loran
  (sagarrak daude loran)

- orrek dos domekatan mesara
  (horiek doaz igandeetan mezara)

- itxiostesu baken
  (utz iezadazu baketan)





Izenaren inguruan adjetiboa edo izen laguna agerkeran mugatu egiten dela dirudi, adibidez:

- imin dot beskari su txikerren
  (ipini dut bazkaria su txikian)

- sartu deude iturriko uren
  (sartu dute iturriko urean)

"esker" berbarekin ez da gauza bera jasotzen, adibidez:

- nire eskerretara yarri dire
  (nire ezkerretara jezarri dira)

## 2.2. ERAKUSLEAK

### 2.2.1. Erakuslearen kokagunea:

Bizkaieraz nahikoa arrunta izaten den legez hemen ere erakuslea izenaren atzean kokatzen da, adibidez:

**Singularra:**

- koyu ori seńe
  (hartu sein hori)

- au etze sarra da
  (etxe hau zaharra da)

- a gisona kanpoko da
  (gizon hura kanpokoa da)

- ori neske emeko da
  (neska hori hemengoa da)

**Plurala:**

- onek ogik ekar doas
  (ogi hauek ekarri ditut)

- orrek señek etor dires
  (sein horiek etorri dira)

- emen nabil onekas gausakas
  (hemen nabil gauza hauekin)

- onek gausok dabiltes eskuarten
  (gauza hauek darabiltzat esku artean)

Leku denborazko kasuetan erakuslea bietara agertzen zaigu, izenaren aurrean baina baita izenaren ostean ere, adibidez:

**Izenaren ostean:**

- iru egun ontan esta etorri
  (hiru egun hauetan ez da etorri)

- erri ontan estao eskolarik
  (herri honetan ez dago eskolarik)

- egun ortarik estot ikusi
  (egun horretatik ez dut ikusi)

- egun ortararten emen eongo nas
  (egun horretara artean hemen egongo naiz)

- aste ontan yon ber dot orti
  (aste honetan joan behar dut hortik)

- egon nas erri ortan
  (egon naiz herri horretan)





**Izenaren aurrean:**

- onetan egunetan esta etorri
  (egun hauetan ez da etorri)

- onetan egunetan kanpon egon nas
  (egun hauetan kanpoan egon naiz)

Leku alorrean erakuslearen ordez adberbioak erabiltzen dira, berauek ere izenaren aurrean kokatuta, adibidez:

- ona etzera etor dires
  (etxe honetara etorri dira)

- orti bideti yon dire
  (bide horretatik joan dira)

## 2.2.2. Erakusleen paradigmak

| HAU | HORI | HURA |
|---|---|---|
| au | ori | a |
| onek | orrek | ak/arek |
| oneri | orreri | ari/areri |
| onena | orrena | aine/arena |
| one(g)as | orre(g)as | agas/areas |
| onentzako | orrentzako | arentzako[3] |
| one(g)aitik | orre(g)aitik | are(g)aitik |
| one(g)ana | orre(g)ana | are(g)ana |

[3] Paradigman agertzen direnen ordez "onentzat", "orrentzat" eta "arentzat" ere erabiltzen dira, berauen erabilera askoz bakanagoa den arren.

| HAUEK | HORIEK | HAIEK |
|---|---|---|
| onek | orrek | aik |
| onek | orrek | aik |
| oneri | orreri | airi |
| onena | orrena | aine |
| onekas | orrekas | aikes |
| onentzako | orrentzako | aintzako |
| onekaitik | orrekaitik | arekaitik |
| onekana | orrekana | aikana |

## 2.2.3. Erakusle indartuak

Erakusle indartu hauek erabiltzeko nolabait baldintza bi bete behar direla esan dezakegu, bata galdegaigunean egotea, eta bestea, posibilitate bakartzat berori ematea, hots, gainerako aukera guztiak baztertzea; hona hemen adibide batzu:

- autxe etor da
  (hauxe etorri da)

- koyu oritxe
  (hartu horixe)

- atxe etor letike
  (huraxe etor liteke)

- emoyosu onetxeri
  (eman iezaiozu honexeri)

Hona hemen erakusle indartu hauen taula:





| HAUXE | HORIXE | HURAXE |
|---|---|---|
| autxe | oritxe | atxe |
| onetxek | orretxek | atxek |
| onetxeri | orretxeri | aretxeri |
| onetxena | orretxena | aretxena |
| onetxeas | orretxeas | aretxeas |
| onetxentzat | orretxentzat | aretxentzat |
| onetxeaitik | orretxeaitik | aretxeaitik |
| onetxeana | orretxeana | aretxeana |

## 2.2.4. Erakusle berrindartuak:

"berau", "berori" eta "bera" errepikari gisa erabiltzen dira, erreferentzia izen bati edo beste erakusle bati egiten diotela, hona hemen adibide batzu:

- beraas berba in deue
  (berarekin berba egin dute)

- emoyok oneri beoneri
  (emaiozu honi beroni)

Hona hemen erakusle berrindartuon paradigmak:

| BERAU | BERORI | BERA | EURAK |
|---|---|---|---|
| berau | beori | bera | eurek |
| beonek | beorrek | berak | eurek |
| beoneri | beorreri | berari | eureri |
| beonena | beorrena | berana | eurena |
| beoneas | beorreas | beraas | eurekas |
| beonentzako | beorrentzako | berantzako | eurentzat |
| beoneaitik | beorreaitik | beraitik | eurekaitik |
| beoneana | beorreana | beraana | eurekana |

Erakusle berrindartuok askotan erabiltzen dira erakusle arruntekin batera, adibidez:

- areas beraas etor dok
  (harekin berarekin etorri duk)

- au arentzako berantzako dok
  (hau harentzat berarentzat duk)

- au berau areana beraana yon da
  (hau berau harengana berarengana joan da)

Era berean erakusle indartuekin batera ere agertzen dira, adibidez:

- atxek berak yon yok
  (harexek berak jan dik)

- aretxeri berari emongo yotzetek
  (harexeri berari emango zioat)

- aretxentzako berantzako dok
  (harexentzat berarentzat duk)

## 2.2.4.1. BERE/BERAREN

Arazo honi dagokionez, berauen artean oposiziorik inoiz egon bada gaur egun neutralizatuta dagoela esan dezakegu, hiztun batzuk "bere" baino ez dute erabiltzen kokagune guztietan, beste batzuk, ostera, Udondokoek, errepikariak baino ez dituzte erabiltzen. Hona hemen adibide bitzuk, batzutan "bere" baino ez zaigu agertuko, besteetan, Udondon Jasonekoetan, "beraren" baino ez dugu.

**Subjetuaren kokagunean:**

- etorri dako bere lagune
  (etorri zaio bere laguna)





- orrek ekar ditus ollok eta bere anajek il ditus
  (horrek ekarri ditu oiloak eta bere anaiak hil ditu)

- orrek ekar ditus madarik eta bere aitek yan ditus
  (horrek ekarri ditu madariak eta bere aitak jan ditu)

- bere aitek yo in deu
  (bere aitak jo egin du)

- bere amak beti ite otzo euskere
  (bere amak beti egiten dio euskera)

- bere lagune beti dator belu
  (bere laguna beti dator belu)

- bere arrebek dakar afari
  (bere arrebak dakar afaria)

**Menpeko esaldiaren subjetua izanik:**

- Mikelek esan deu bere lagune etor dala
  (Mikelek esan du bere laguna etorri dela)

- orrek esan deu bere aiste yon dala
  (horrek esan du bere ahizpa joan dela)

**Subjetua ez denean:**

- suk saldu osu bere etze
  (zuk saldu duzu bere etxea)

- orrek ikus deu bere seme fumetan
  (horrek ikusi du bere semea erretzen)

UDODNDOKO ADIBIDEAK

**Subjetoa denean:**

- beran aitek yo deu
 (beraren aitak jo du)

- areri beran ollo il yako
 (hari beraren oiloa hil zaio)

- beran aistek ekar deu afari
 (beraren ahizpak ekarri du afaria)

**Subjetoa ez denean:**

- au berana da
 (hau berarena da)

- ak beran etze saldu yen
 (hark beraren etxea saldu zuen)

- orrek beran seme ikus deu fumaten
 (horrek beraren semea ikusi du erretzen)

## 2.2.4.2. BERETZAT/BERARENTZAT

Berauen artean inoiz oposiziorik egon bada ere gaur egun ezabaturik dagoela esan dezakegu, izan ere, "berantzat" edo "berantzako" baino ez dira erabiltzen, adibidez:

- ogi ekar du berantzako
 (ogia ekarri dugu berarentzat)

- berak ekar deu liburu berantzako bakarrik
 (berak ekarri du liburua berarentzako bakarrik)





- emon dotzet diru bakarrik berantzat
 (eman diot dirua bakarrik berarentzat)

- berantzat in deu bearra
 (berarentzat egin du beharra)

## 2.2.5. AAU

Serie honetako erakusleak esklamazioetan eta aukera egiten denean multzo batetako elementuen artean erabiltzen dira, adibidez:

- aorreana yon nok
 (aorregana joan nauk)

- guk aonek gausek yarusek
 (guk aonek gauzak diaramatzaagu)

Hona hemen erakusle hauen paradigmak:

| AAU | AORI |
|---|---|
| aau | aori |
| aonek | aorrek |
| aoneri | aorreri |
| aonena | aorrena |
| aoneas | aorreas |
| aonentzako | aorrentzako |
| aoneana | aorreana |

# 2.3. ZENBATZAILEAK

## 2.3.1. Zenbakiak:

| | | |
|---|---|---|
| 1. bat | 11. amaka | 21. ogetabat |
| 2. bi | 12. amabi | 22. ogetabi |
| 3. iru | 13. amairu | 23. ogetairu |
| 4. lau | 14. amalau | 24. ogetalau |
| 5. bost | 15. amabost | 25. ogetabost |
| 6. sei | 16. amasei | 26. ogetasei |
| 7. saspi | 17. amasaspi | 27. ogetasaspi |
| 8. sortzi | 18. amasortzi | 28. ogetasortzi |
| 9. bederatzi | 19. emeretzi | 29. ogetabederatzi |
| 10.amar | 20. ogei | 30. ogetamar |

| | |
|---|---|
| 40. berrogei | 50. berrogetamar |
| 60. irurogei | 70. irurogetamar |
| 80. laurogei | 90. laurogeitamar |
| 100. eun | |

## 2.3.2. "bat"en erabilerak.

**a) Neurriak adierazteko:**

Kasu honetan "bat" en ordez askotan "bete" erabiltzen da, adibidez:

- edan du baso bete ur
  (edan dugu baso bete ur)

- ekar du gurtada bat bedar
  (ekarri dugu gurtada bat belar)





- emoidesu kilo bat madari
  (emaidazu kilo bat madari)

- darot ordu bete emen begire
  (daroat ordu bete hemen begira)

Gainerako zenbakiekin gauza bera egin daiteke, adibidez:

- suetek dekos iru metro luse
  (sukaldeak dauzka iru metro luze)

Deklinatuz gero deklinabidearen atzizkia izenari eransten zaio, adibidez:

- senbet balio deu kilo bat madarik?
  (zenbat balio du kilo bat madarik?)

- kilo bat madaries esteku naiko
  (kilo bat madarirekin ez daukagu nahikoa)

**b) -REN BAT**

Kopuru zehaztubakoak adierazteko erabiltzen da, adibidez:

- etor dire amarren bat lagun
  (etorri dira hamarren bat lagun)

- afaltan yongo gara amabostan bat lagun
  (afaltzera joango gara hamabosten bat lagun)

**c) BAT BERE**

- estot ekarri libururik ba pere
  (ez dut ekarri libururik bat ere)

- esta etorri umerik bapere
  (ez da etorri umerik bat ere)

## 2.3.3. Ordinalak.

1. lelengoko
2. bigarrena
3. irugarrena
4. laugarrena
5. boskarrena
6. seigarrena
7. saspigarrena
8. sortzigarrena
9. bederatzigarrena
10. amargarrena

## 2.3.4. Distributiboak.

Distributiboak adierazteko -NA erabiltzen da, adibidez:

- atara sati bana bakotxari
  (atera zati bana bakoitzari)

- ekar dus irune bakotxak
  (ekarri ditugu hiruna bakoitzak)

- bakotxak imingou bine
  (bakoitzak ipiniko dugu bina)

## 2.3.5. -KO atzizki banatzailea:

- orrek kobraten deude eun peseta kiloko
  (horiek kobratzen dute ehun pezeta kiloko)

- emoten deude berreun orduko
  (ematen dute berrehun orduko)





## 2.3.6. BIDER/-TAN

- senbet bider eon sara or?
  (zenbat bider egon zara hor?)

- egon nas iru bider
  (egon naiz hiru bider)

- ori dator asten birriten
  (hori dator astean birritan)

- bein egon nitzen sure errin
  (behin egon nintzen zure herrian)

- ori dator askotan
  (hori dator askotan)

- batzuten etorten dires
  (batzutan etortzen dira)

Beste barietateetako "gutxitan" erabili beharrean "nekes" erabiltzen da, adibidez:

- neskes lotu da lo iten
  (nekez geratu da lo egiten)

- nekes lotzen da lo
  (nekez geratzen da lo)

## 2.3.7. Zehaztugabeak.

**a) ASKO**

- asko etor dire
  (asko etorri dira)

- ume asko dao
  (ume asko dago)

**b) GITXI**

- gause gitxi ekar deitus
  (gauza gutxi ekarri ditu)

- intxur gitxi ekar doas
  (intxaur gutxi ekarri ditut)

**c) UGERI**

- emen ganadu ugeri dao
  (hemen ganadu ugari dago)

- emen umek ugeri daos
  (hemen umeak ugari daude)

**d) FRANKU**

- urte franku isen da
  (urtea frankoa izan da)

- franku dao gause
  (franko dago gauza)

- se franku daon yateko!
  (ze franko dagoen jateko!)





- franku deku yateko
  (franko daukagu jateko)

**e) APUR BET**

- ogi aputxu bet ekasu
  (ogi apurtxu bat ekarzu)

- ure aputxu bet edan du
  (ur apurtxo bat edan dugu)

**f) AINBET**

- ekar doas ainbèt kinpule
  (ekarri ditut hainbat kinpula)

- ainbet gause ekar ditu
  (hainbat gauza ekarri ditu)

- ainbet ume daos emen
  (hainbat ume daude hemen)

**g) MAKINE BAT**

- makine bat piper auki du
  (makina bat piper eduki dugu)

- makine bat ume dao
  (makina bat ume dago)

**h) AREN**

- esta etorri umerik aren
  (ez da etorri umerik arean)

- suk estekosu aren
  (zuk ez daukazu arean)

- surok estakisue aren
  (zuek ez dakizue arean)

- aren bere pasa da emeti eta estu ikusi
  (arean bere pasatu da hemendik eta ez dugu ikusi)

- estosu ekarri aren
  (ez duzu ekarri arean)

**i) NAYE**

- naye etor da
  (zenbatgura etorri da)

- aurten piper naye koyu du
  (aurten piper nahia hartu dugu)

- badao ume naye emen
  (badago ume nahia hemen)

## 2.3.8. Zenbatzaile orokorrak.

**a) DANA**

Berau izen ordain gisa erabiltzen da, adibidez:

- gu danok gare emekok
  (gu denok gara hemengoak)

- danak etor dire
  (denak etorri dira)





**b) DUSTI**

Berau dela izen ordain gisa dela zenbatzaile gisa erabil daiteke, adibidez:

- ekar deituese gause dustik
  (ekarri dituzte gauza guztiak)

- esayosu ekar dile dusti
  (esaiozu ekar dezala guztia)

- surori aistu yatzuen dusti
  (zuei ahaztu zitzaizuen guztia)

## 2.3.9. BATZU

- etor dire gison batzuk
  (etorri dira gizon batzu)

- gison batzuk afaldu deue
  (gizon batzuk afaldu dute)

- emon dotzet esne ume batzuri
  (eman diet esnea ume batzuri)

- andra batzukes egon nas
  (andre batzurekin egon naiz)

Hona hemen beronen partadigma:

| | |
|---|---|
| batzuk | batzuten |
| batzuk | batzutera |
| batzuri | batzuteti |
| batzune | batzutekok |
| batzukes | batzuterantza |
| batzuntzet | batzuteraño |
| batzukana | |
| batzukaitik | |

# 3. IZEN ORDAINAK

## 3.1. IZEN ORDE PERTSONALAK

| NI | HI | GU | ZU | ZUEK |
|---|---|---|---|---|
| ni | i | gu | su | surok |
| nik | ik | guk | suk | surok |
| niri | iri | guri | suri | surori |
| nire | ire | gure | sure | surona |
| nies | ies | gues | sues | surokas |
| nitzet | iretzat | guretzat | suretzat | surontzat |
| niaitik | iaitik | guaitik | suaitik | surokaitik |
| niana | iana | guana | suana | surokana |

### 3.1.1. Izenorde pertsonal intentsiboak

| NEU | HEU | GEU | ZEU | ZEUEK |
|---|---|---|---|---|
| neu | eu | geu | seu | seurok |
| neuk | euk | geuk | seuk | seurok |
| neuri | euri | geuri | seuri | seurori |
| neure | eure | geure | seure | seurona |
| neues | eues | geues | seues | seurokas |
| neuretzat | euretzat | geuretzat | seuretzat | seuontzat |
| neugaitik | eu(g)aitik | geugaitik | seugaitik | seuokaitik |
| neugana | eugana | geugana | seugana | seurokana |

Zutabe hauetan agertzen diren era indartuok erabiltzeko galdegaigunean agertu behar dira, adibidez:

- neuk ikus dot
  (neuk ikusi dut)

- neu nas emeko
  (neu naiz hemengoa)

- seuk esan dosu
  (zeuk esan duzu)

- geu yon gare
  (geu joan gara)

NOREN kasuan erreflexiboak direnez gero, era indartuak subjetoarekin komunztadura eduki behar du, komunztadura hori egon ezik ez indartuak dira, adibidez:

- ekar dot neure automobile
  (ekarri dut neure automobila)

- euki dot seńe neure besotan
  (eduki dut seina neure besoetan)

- ekar dosu nire libru?
  (ekarri duzu nire liburua?)

- nik ekar dot sure kotxe
  (nik ekarri dut zure kotxea)





## 3.2. IZEN ORDAIN KONPOSATUAK

### a) INOR/BATEREN BAT

"Inor" ezezko eta galderetan agertzen da; "bataren bat", ostera, baiezkoetan, adibidez:

- ikus dosu inor?
  (ikusi duzu inor?)

- es dot ikusi inor
  (ez dut ikusi inor)

- estu ekarri inor
  (ez dugu ekarri inor)

- bataren bat sartu da etzen
  (baten bat sartu da etxean)

- bataren bateri emongotzet
  (baten bati emango diot)

- etzen ikusiko su bataren bat
  (etxean ikusiko duzu baten bat)

- bataren bat agertuko da
  (baten bat agertuko da)

### b) ESER/SEOSER

"eser" ezezko eta galderetan erabiltzen da, "seoser" galdera eta baiezkoetan, adibidez:

- eros dosu eser?
  (erosi duzu ezer?)

- badekosu erretratorik edo olao seoser?
  (badaukazu erretratorik edo holako zerozer?)

- orrek seoser ekar deude
  (horiek zerozer ekarri dute)

- amak seoser yakarrena
  (amak zerozer diakarren)

Hona hemen "inor"en deklinabidea:

| | |
|---|---|
| inor | inoas |
| inok | inontzat |
| inori | inoana |
| inona | inoaitik |

**c) EDOSEIN**

- edosein etor letike
  (edozein etor liteke)

"edosein" hau izenarekin batera ager dakiguke, adibidez:

- esaisu edosein gause
  (esaizu edozein gauza)

## 3.3. -EN BAT

- ikus dosu ori lekuren baten?
  (ikusi duzu hori lekuren batetan?)

- umeran bat bier etorko da
  (umeren bat bihar etorriko da)





- orrek igual ekarriko deude ardiran bat
  (horiek igual ekarriko dute ardiren bat)

## 3.4. BAKOTXA

- bakotxa bisi da bere etzen
  (bakoitza bizi da bere etxean)

- bakotxak iten deu al deuna
  (bakoitzak egiten du ahal duena)

## 3.5. NORBERA

- ori da gatxa noperetzako baye
  (hori da zaila norberentzat baina)

- ori noperak in lei
  (hori norberak egin lezake)

## 3.6. -EN BURU

- uretara bota deu bere buru
  (uretara bota du bere burua)

- beorrek il deu bere buru
  (berorrek hil du bere burua)

- espillun ikusi dot neure buru
  (espiluan ikusi dut neure burua)

- kotxe etor danen neure buru kunetara bota ber isen dot
  (kotxea etorri denean neure burua kunetara bota behar izan dut)

## 3.7. ALKAR

- alkarreas yan du
  (elakarrekin jan dugu)

- orrek alkarreas etor dire
  (horiek elakarrekin etorri dira)

- guk alkar esaututen du
  (guk elkart ezagutzen dugu)

- yarri gare alkarren atzen
  (jarri gara elkarren atzean)

- alkarreana yon dire
  (elkarrengana joan dira)

- alkarreri aitu dotze
  (elkarri begiratu diote)

- bateti yon besteti yon eta aparta alkar ikusi barik
  (batetik joan bestetik joan eta berezi elkar ikusi barik)

- su yon sara bide bateti te ni besteti te utzin du elkar
  (zu joan zara bide batetik eta ni bestetik eta huts egin dugu elkar)

- alkar entzun du
  (elkar entzun dugu)

- alkarrentzat ekar deude
  (elkarrentzat ekarri dute)





Hona hemen "alkar" honen deklinabidea:

alkar
alkarreri
alkarren
alkarreas
alkarrentzat
alkarreana

"alkarreas" erabili beharrean batzutan "batera" ere erabiltzen da, adibidez:

- batera yan du beskari
  (batera jan dugu bazkaria)

Bestalde, "alkar" erabili beharrean "bata eta beste" ere erabiltzen dira, adibideaz:

- yesarri gare biok bata besten atzen
  (jezarri gara biok bata bestearen atzean)

## 3.8. GALDEKARIAK.

Galdekari guztiak izen ordainak ez diren arren hemen guk jasoneko guztiak ezarriko ditugu:

| | |
|---|---|
| nor | non |
| nok | nora |
| nori | nondi |
| noina | nongo |
| noas | norako |
| nontzat | norantza |
| noaitik | noraño |
| noana | |
| noganik | |

ser/se
seas
setan
setako
setati
seaitik/seaitearrik

nos
nosik ona
nosko
nos arten

sein
senbet/senbest
selan
selango/selao

"senbet" galdekariari kasu markaren bat ezartzean mugatu egiten dela dirudi, adibidez:

- senbeten gos?
  (zenbatean goaz?)

- senbeten egon zara?
  (zenbatean egon zara?)

Bestalde, prezioa eskatukeran "sean" galdekaria erabiltzen da, adibidez:

- ori sean dekosu?
  (hori zegan daukazu?)





# 4. ADITZONDOAK

## 4.1. LEKU ADITZONDOAK.

| HEMEN | HOR | HAN |
|---|---|---|
| emen | or | an |
| ona | orra | ara |
| emeti | orti | andi |
| emeko | orko | ango |
| onantza | orrantza | arantza |
| onaño | orraño | araño |

### 4.1.1. Aditzondo indartuak

| HEMENTXE | HORTXE | HANTXE |
|---|---|---|
| ementxe | ortxe | antxe |
| onatxe | orratxe | aratxe |

Aditzondo hauek ez dira oso erabiliak izaten, eta paradigman ezarrikoak baino ezin jaso izan ditugu. Hona hemen adibide batzu:

- egon nas ortxe
  (egon naiz hortxe)

- antxe dao
  (hantxe dago)

- onek yon dire aratxe
  (hauek joan dira haraxe)

## 4.1.2. Era berrindartuak

| BERTON | BERTAN |
|---|---|
| berton | bertan |
| bertora | bertara |
| bertoti | bertati |
| bertoko | bertako |
| bertorantza | bertarantza |
| bertoraño | bertaraño |

Aditzondo berrindartu hauek errepikariak baino ez dira. Hurbiltasuna adierazteko erabiltzen direnak galduz doazela esan dezakegu beroien ordez besteak erabiltzen dira eta; hona hemen adibide batzu:

- dao emen bertan
  (dago hemen bertan)

- ona etor dire eta bertan lotu dire
  (hona etorri dira eta bertan lotu dira)

- amen berton bisi dosak
  (hemen berton bizi dituk)

- ona bertora etor dosak
  (hona bertora etorri dituk)

- bertoti yabiltzesak
  (bertotik diabiltzak)





## 4.1.3. AMEN, AOR

| | |
|---|---|
| amen | aor |
| aona | aorra |
| ameti | aorti |
| ameko | aorko |
| aonantza | aorrantza |
| aonaño | aorraño |

- aorko etzekok dosak orrek
  (aorko etxekoak dituk horiek)

- etor dire aonaxe bertara
  (etorri dira aonaxe bertara)

- ene aor daos ardik!
  (ene aor daude ardiak!)

## 4.1.4. Aditzondo konposatuak.

| a) | b) | c) | d) | e) |
|---|---|---|---|---|
| ihon | batabaten | nosgure | edoselan | edosein |
| inora | batabatera | selangure | edonos | |
| ihondi | batabateti | senbetgure | | |
| ihongo | | | | |
| inos | | | | |

a) Serie honetakoak galdera eta ezezkoetan erabiltzen dira:

- ikus dosu inon?
  (ikusi duzu inon?)

- egon sara inos or?
  (egon zara inoiz hor?)

- esara inos egon or?
  (ez zara inoiz egon hor?)

- es deude topa lekurik inon bere
  (ez dute topatu lekurik inon ere)

- ori estator inos arin
  (hori ez dator inoiz arin)

- enas inos egon Donostin
  (ez naiz inoiz egon Donostian)

- orrek estos inora
  (horiek ez doaz inora)

- ori estosu ingo eselan bere ondo
  (hori ez duzu egingo ezelan ere ondo)

b) Serie honetakoak galdera eta baiezkoetan erabiltzen dira:

- yon dire bata batera?
  (joan dira baten batera?)

- ori ikusi deude batabaten
  (hori ikusi dute baten baten)

- bata batera ingo du ondo
  (baten batera egingo dugu ondo)





- orrek batabatera dos
  (horiek baten batera doaz)

c)

- nosgure agertuko dires
  (noizgura agertuko dira)

- selangure esan sengi
  (zelangura esan zenezake)

- edan diela senbetgure
  (edan dezala zenbatgura)

d)

- edonos isen letike
  (edonoiz izan liteke)

- edoselan ingo du ori
  (edozelan egingo dugu hori)

e)

- ori edosein lekuten topa sengi
  (hori edozein lekutan topa zenezake)

Askotan "edosein" erabilkeran ez da mugagabea egiten, adibidez:

- bados edosein lekure
  (badoaz edozein lekutara)

- yon letike edosein lekure
  (joan liteke edozein lekutara)

### 4.1.4.1. "nosonos"

Berau izan da era honetakorik aurkitu dugun bakarra:

- nosonos etor dires
  (noiz edo noiz etorri dira)





# 5. DEKLINABIDEA

Leioako deklinabidea emateko bokal bakoitzeko berba bat aukeratu dugu, eta kontsonantez amaituko beste bat, alaba, seme, idi, asto, katu eta gison dira aukeratuko berbak.

Hona hemen berbon paradigmak:

ALABA

| Mug. | Sing. | Plu. |
|---|---|---|
| alaba | alabe | alabak |
| alabek | alabek | alabak |
| alabari | alaberi | alabari |
| alabena | alabena | alabana |
| alabeas | alabeas | alabakas |
| alabentzat | alabentzako | alabantzako |
| alabeaitik | alabeaitik | alabakaitik |
| alabeana | alabeana | alabakana |
| alabeanik | alabeanik | alabakanik |

SEME

| Mug. | Sing. | Plu. |
|---|---|---|
| seme | seme | semek |
| semek | semek | semek |
| semeri | semeri | semeri |
| semena | semena | semena |
| semeas | semeas | semekas |
| sementzako | sementzako | sementzako |
| semeaitik | semeaitik | semekaitik |
| semeana | semeana | semekana |
| semeanik | semeanik | semekanik |

IDI

| Mug. | Sing. | Plu. |
|---|---|---|
| idi | idi | idik |
| idik | idik | idik |
| idiri | idiri | idiri |
| idine | idine | idine |
| idies | idies | idikes |
| idintzeko | idintzeko | idintzeko |
| idiaitik | idiaitik | idikaitik |
| idiana | idiana | idikana |
| idianik | idianik | idikanik |

ASTO

| Mug. | Sing. | Plu. |
|---|---|---|
| asto | asto | astok |
| astok | astok | astok |
| astori | astori | astori |
| astona | astona | astona |
| astoas | astoas | astokas |
| astontzako | astontzako | astontzako |
| astoaitik | astoaitik | astokaitik |
| astoana | astoana | astokana |
| astoanik | astoanik | astokanik |

KATU

| Mug. | Sing. | Plu. |
|---|---|---|
| katu | katu | katuk |
| katuk | katuk | katuk |
| katuri | katuri | katuri |
| katune | katune | katune |
| katues | katues | katukes |
| katuntzeko | katuntzet | katuntzet |
| katuaitik | katuaitik | katukaitik |
| katuana | katuana | katukana |
| katuanik | katuanik | katukanik |





GISON

| Mug. | Sing. | Plu. |
|---|---|---|
| gison | gisona | gisonak |
| gisonak | gisonak | gisonak |
| gisonari | gisonari | gisonari |
| gisonana | gisonana | gisonana |
| gisonaas | gisonaas | gisonakas |
| gisonantzako | gisonantzat | gisonantzat |
| gisonaitik | gisonaitik | gisonakaitik |
| gisonaana | gisonaana | gisonakana |
| gisonaanik | gisonaanik | gisonakanik |

Bizigabeen kasu markak emateko berba bi aukeratu dugu, "etze" eta "baso"; hona hemen berbon paradigmak:

ETZE

| Mug. | Sing. | Plu. |
|---|---|---|
| etzetan | etzen | etzetan |
| etzetara | etzera | etzetara |
| etzetati | etzeti | etzetati |
| etzetako | etzeko | etzetako |
| etzetarantza | etzerantza | etzetarantza |
| etzetaraño | etzeraño | etzetaraño |
| etzetarako | etzerako | etzetarako |

BASO

| Mug. | Sing. | Plu. |
|---|---|---|
| basotan | bason | basotan |
| basotara | basora | basotara |
| basotati | basoti | basotati |
| basotako | basoko | basotako |
| basotarantza | basorantza | basotarantza |
| basotaraño | basoraño | basotaraño |
| basotarako | basorako | basotarako |

# 5.2. OHARRAK KASUZ KASU

## 5.2.1. NOR

| Mug. | Sing. | Plu. |
|---|---|---|
| alaba | alabe | alabak |
| seme | seme | semek |
| idi | idi | idik |
| asto | asto | astok |
| katu | katu | katuk |
| gison | gisona | gisonak |

Dakusagunez kasu honek ez du ezaugarri berezirik, edo hobeto esanda 0 dugu kasu honen marka.

Hona hemen kasu marka honen bidez egiten diren posposizio batzu:

**a) 0 BARIK**

- diru barik yon dire
  (diru barik joan dira)

Berau aditzekin ere erabil daiteke, adibidez:

- erosiu ausi barik
  (eroaizu hautsi barik)

- lo in barik dao seña
  (lo egin barik dago seina)

**b) 0 BARRU**

- iru egun barru etorko nas
  (hiru egun barru etorriko naiz)





- aste bete barru yongo dire
  (aste bete barru joango dira)

- lau aste barru yon ber dot
  (lau aste barru joan behar dut)

Posposizio honen ordez askotan, batez ere iraganeraz, -GARREN atzizkia erabiltzen da, adibidez:

- irugarren egunen yon san
  (hirugarren egunean joan zen)

- ordu erdigarrenen yon san
  (ordu erdigarrenean joan zen)

- ainbeskarrenen ikus du
  (hainbestegarrenean ikusi dugu)

- seribet egungarrenen entrega ber du au?
  (zenbat egungarrenean entregatu behar dugu hau?)

## 5.2.2. NORK

Kasu honen ezaugarria "-K" dugu ondoko adibideotan ikus daitekeen legez:

| Mug. | Sing. | Plu |
|---|---|---|
| alabek | alabek | alabak |
| semek | semek | semek |
| idik | idik | idik |
| astok | astok | astok |
| katuk | katuk | katuk |
| gisonak | gisonak | gisonak |

## 5.2.3. NORI

Kasu honen ezaugarria "-RI" dugu:

| Mug. | Sing. | Plu. |
|---|---|---|
| alabari | alaberi | alabari |
| semeri | semeri | semeri |
| idiri | idiri | idiri |
| astori | astori | astori |
| katuri | katuri | katuri |
| gisonari | gisonari | gisonari |

Hona hemen kasu honen bidez egiten den posposizio bat:

-RI GRASIEK

- kosi gendun trena grasiek anajeri
  (hartu genuen trena eskerrak anaiari)

## 5.2.4. ZERIK

Kasu hau paradigman paratu ez dugun arren sano erabilia izaten da, beronen ezaugarria "-RIK" dugu eta mugagabean baino ez da erabiltzen, adibidez:

alabarik
semerik
idirik
astorik
katurik
gisonik

Erabilerari dagokionez ezezko eta galderetan ager dakigukeela esan dezakegu, beti ere erreferentziabakoa izanik, adibidez:





**Galderetan:**

- baikosu surik?
  (badaukazu surik?)

- baikosu ogirik?
  (badaukazu ogirik?)

- sagarrik baikosu?
  (sagarrik badaukazu?)

- gurdosu sagarrik?
  (gura duzu sagarrik?)

**Ezezkoetan:**

- estekot dirurik
  (ez daukat dirurik)

- orrek esteko umerik
  (horrek ez dauka umerik)

- etzen estao ogirik
  (etxean ez dago ogirik)

- estu ekarri eselao ogirik
  (ez dugu ekarri ezelako ogirik)

- esta etorri umerik bere
  (ez da etorri umerik ere)

Hala ere, bai ezezko edo galderetan, erreferentziaduna izanez gero horonen ordez mugatzailea agertuko litzaiguke, adibidez:

- ogi dekosu?
  (ogia daukazu?)

- dekosu sue?
  (daukazu sua?)

- baikosu ogi?
  (badaukazu ogia?)

- emen estao sure diru
  (hemen ez dago zure dirua)

- etzen estao señen esne
  (etxean ez dago seinaren esnea)

- etzen estao aman ogi
  (etxean ez dago amaren ogia)

Kasu marka bion erabilera ondoko taularen bidez laburki eman dezakegu:

| | BAIEZKOA | EZEZKOA | GALDERA |
|---|---|---|---|
| -ERREFERENTZIA | -A | -RIK | -RIK |
| +ERREFERENTZIA | -A | -A | -A |

## 5.2.5. NOREN

Kasu honen ezaugarria "-REN" dugu:

| Mug. | Sing. | Plu. |
|---|---|---|
| alabena | alabena | alabana |
| semena | semena | semena |
| idine | dine | idine |
| astona | astona | astona |
| katune | katune | katune |
| gisonana | gisonana | gisonana |





Kasu marka honen bidez posposizio gehienak egiten dira, hona hemen guk jasonekoak:

**a) -EN KONTRA**

- orrek sure kontra daos
  (horiek zure kontra daude)

**b) -EN ANTZA**

- orrek deko aiten antza
  (horrek dauka aitaren antza)

**c) -EN GANEN**

- orren ganen in du berba
  (horren gainean egin dugu berba)

**d) -EN KONTURE**

- orrek aman konture bisi dire
  (horiek amaren kontura bizi dira)

**e) -EN BEGIRA**

- autobusen begire daos
  (autobusaren begira daude)

- nire begire egon sara
  (nire begira egon zara)

**f) -EN GANERA**

- ogin ganera eron genki ure bere
  (ogiaren gainera eroan genezake ura ere)

- orren ganera eron genki yatordu bere
(horren gainera eroan genezake jatordua ere)

**g) -EN BILE**

- orrek ogin bile yon dire
(horiek ogiaren bila joan dira)

- aiten bile yon dire
(aitaren bila joan dira)

- etor dire nire bile
(etorri dira nire bila)

**h) -EN LEKUN**

- ogin lekun ure eron genki
(ogiaren lekuan ura eroan genezake)

- igual baten lekun dinotzut nik beste
(igual baten lekuan dinotsut nik bestea)

**i) -EN ORDES**

- berakatzak ekar deituse kinpullen ordes
(berakatzak ekarri dituzte kinpulen ordez)

- primon ordes anaje etor da
(lehengusuaren ordez anaia etorri da)

Aditza denean "ordes"en ordez "berren" erabiltzen da, adibidez:

- lengusu etor berren anaje etor san
(lehengusua etorri beharrean anaia etorri zen)

- berakatzak ekarri berren ekar situsen kinpuliek
(berakatzak ekarri beharrean ekarri zituen kinpulak)





- oñes yon berren sos trenen
(oinez joan beharrean zoaz trenez)

- inusentekerik esan berren obeto egongo sentikes isilik
(lelokeriak esan beharrean hobeto egongo zinateke isilik)

**j) -EN ALDEN**

- orrek koiten deu pisu andi besten alden
(horrek hartzen du pisu handia bestearen aldean)

- orrek askos giao balio deue besten alden
(horiek askoz gehiago balio dute besteen aldean)

**k) -EN ANTZEN**

- gure antzen iten dosu berba suk
(gure antzean egiten duzu berba zuk)

**l) -EN OSTEN**

- onen osten dao ori
(honen ostean dago hori)

**m) -EN GANEN, ASPIN, ONDON, ARTEN, INGIRUN, AURREN, ATZEN**

- mayen ganen itxi dot
(mahaiaren gainean utzi dut)

- sillen aspin imini isu
(aulkiaren azpian ipin ezazu)

- bearra in du bion arten
  (beharra egin dugu bion artean)

- elisen ingirun ibil dire
  (elizaren inguruan ibili dira)

- itxi aten atzen
  (utzi atearen atzean)

- etzen aurren imin deude
  (etxearen aurrean ipini dute)

- errekan ondon etze bat dao
  (errekaren ondoan etxe bat dago)

## 5.2.6. NOGAZ

Kasu honen ezaugarria "-AS" dugu:

| Muga. | Sing. | Plur. |
|---|---|---|
| alabeas | alabeas | alabakas |
| semeas | semeas | semekas |
| idies | idies | idikes |
| astoas | astoas | astokas |
| katues | katues | katukes |
| gisonaas | gisonaas | gisonakas |

Kasu hau denbora alorrean erabiltzen da, adibidez

- egunokas esta etorri
  (egunokin ez da etorri)

- egunokas estot ikusi
  (egunokin ez dut ikusi)





Kasu marka berberau askotan, gehienetan ez bada, instrumentalaren ordez erabiltzen da, hona hemen adibide batzu:

- isi ate giltzeas
  (itxi atea giltzez)

- palues yo deue
  (makilez jo dute)

- martilloas in deue
  (mailuz egin dute)

- seas in dosu ori?
  (zerez egin duzu hori?)

- au pastela inte dao txokolateas
  (pastel hau eginda dago txokolatez)

## 5.2.7. Instrumentala

Kasu marka hau sano gutxitan erabiltzen da, gehienetan -gatik, -as eta -n markak erabiltzen dira beronen ordez; hala ere, hona hemen hainbat adibide:

- gorte eulis beterik dao
  (korta euliz beterik dago)

- bearra eskus in dot
  (beharra eskuz egin dut)

- oñes etor dire
  (oinez etorri dira)

- dusti dao loras beterik
  (guztia dago lorez beterik)

- olan da isetes euskere
  (holan da izatez euskara)

- egon san andre eskondute bigarrenes
  (egon zen andrea ezkonduta bigarrenez)

- ori beres ikisten deue
  (hori berez ikasten dute)

Kasu marka honen gainean egiten den "zerezko" kasua sano erabilia izaten da, adibidez:

- ekar deue olesko maye
  (ekarri dute olezko mahia)

- ori burniesko da
  (hori burdinezkoa da)

- eron dot mimenasko otzare
  (eroan dut mimenezko otzarea)

- in due ladrillosko orma bat
  (egin dute adreiluzko horma bat)

## 5.2.8. NORENTZAT

Kasu honen markak aski nahasirik agertzen zaizkigu, izan ere, -TZAT eta -TZAKO biak erabiltzen dira berauen arteko zedarria ia ezabatu delarik, hona hemen adibide batzu:

- aistu in yat umentzako libru
  (ahaztu egin zait umearentzako liburua)

- onek in deu aitentzat beskari
  (honek egin du aitarentzat bazkaria)





- au arentzako berantzako dok
  (hau harentzat berarentzat duk)

- senbest idintzeko isen da ori?
  (zenbat idirentzat izan da ori?)

Eskuarki kasu marka hau ez da -RAKO markarekin okertzen, adibidez:

- edurre ona da lurrerako
  (elurra ona da lurrerako)

- ori txarra da osasunerako
  (hori txarra da osasunerako)

Hona hemen kasu honen adibide batzu:

| Mug. | Sing. | Plu. |
|---|---|---|
| alabentzat | alabentzako | alabantzako |
| sementzako | sementzako | sementzako |
| idintzeko | idintzeko | idintzeko |
| astontzako | astontzako | astontzako |
| katuntzeko | katuntzet | katuntzet |
| gisonantzako | gisonantzat | gisonantzat |

## 5.2.9. ZERTZAT

Kasu hau paradigmetan paratu ez badugu ere sano erabilia izaten da, beti mugagabea izanik; adibidez:

- artu deude inusentetzat
  (hartu dute lelotzat)

- auki deude laguntzet
  (euki dute laguntzat)

- alkatetzat imin deude ori
  (alkatetzat ipini dute hori)

## 5.2.10. NOGAITIK

Kasu honen ezaugarria "-AITIK" dugu:

| Mug. | Sing. | Plu. |
|---|---|---|
| alabeaitik | alabeaitik | alabakaitik |
| semeaitik | semeaitik | semekaitik |
| idiaitik | idiaitik | idikaitik |
| astoaitik | astoaitik | astokaitik |
| katuaitik | katuaitik | katukaitik |
| gisonaitik | gisonaitik | gisonakaitik |

Hona hemen kasu honen erabileraren adibide batzu:

- sure erruaitik allega gare belu
  (zure erruagaitik heldu gara belu)

- ori in deude diruaitik
  (hori egin dute diruagatik)

- semeaitik pregunta deude
  (semeagatik galdetu dute)

- nigaitik pregunta deude
  (nigatik galdetu dute)

Udondo auzoan kasu honen ezaugarria desberdina da, bertan "-AITEARRIK" erabiltzen da, galdera ere "seaitearrik" dela, adibidez:

- selao gisonaitearrik pregunta deue?
  (zelako gizanagaitik galdetu dute?)

- sure errueitearrik etor gares belu
  (zure erruagatik etorri gara berandu)





- semeitearrik edosein jenero iten da
  (semeengatik edozein gauza egiten da)

## 5.2.11. NOGANA

Kasu honen ezaugarria "-ANA" dugu:

| Mug. | Sing. | Plu. |
|---|---|---|
| alabeana | alabeana | alabakana |
| semeana | semeana | semekana |
| idiana | idiana | idikana |
| astoana | astoana | astokana |
| katuana | katuana | katukana |
| gisonaana | gisonaana | gisonakana |

## 5.2.12. NOGANIK

Kasu honen ezaugarria "-ANIK" dugu:

| Mug. | Sing. | Plu. |
|---|---|---|
| alabeanik | alabeanik | alabakanik |
| semeanik | semeanik | semekanik |
| idianik | idianik | idikanik |
| astoanik | astoanik | astokanik |
| katuanik | katuanik | katukanik |
| gisonaanik | gisonaanik | gisonakanik |

Hona hemen kasu honen erabileraren adibide batzu:

- amaanik ikisi yedek euskere
  (amagandik ikasi diate euskara)

- sein alabeanik yatorrena ba?
  (zein alabarengandik diatorren ba?)

- semeanik yatorrena
  (semeagandik diatorren)

## 5.2.13. NON

Kasu honen ezaugarria "-N" dugu:

| Mug. | Sing. | Plu. |
|---|---|---|
| etzetan<br>basotan | etzen<br>bason | etzetan<br>basotan |

Leku denborako kasuok, berauen izenak adierazten duen legez, lekua, denbora eta neurriak adierazteko erabiltzen ditugu. Sortzen zaigun arazo nagusia mugagabearena dugu, hots, eskuarki mugagabea erabiltzen den kontestuetan "ta" morfema agertzea ala ez. Ondoko lerroetan fenomeno hau aurkeztuko dugu, horretarako lehen aitatuko hiru erabilera horiek kontutan hartuko ditugu; bestalde, gogoraeraztea mugagabea zenbatzaile zehaztuekin, zehaztugabeekin eta galdekariekin erabiltzen dela. Hona hemen NON kasuaren erabilera:

**Lekua:**

- se etzetan dao?
  (ze etxetan dago?)

- sein menditen dao?
  (zein menditan dago?)

- senbet etzetan egon sara?
  (zenbat etxetan egon zara?)

- egon gare iru etzetan
  (egon gara hiru etxetan)





- su leku askotan egon sara
  (zu leku askotan egon zara)

- leku gitxiten ikusko su ori
  (leku gutxitan ikusiko duzu hori)

Ikusten denez leku alorrean kasu guztietan mugagabearen "ta" morfema agertzen zaigu; bada, hala ere, salbuespen bat "edosein"i buruz aipatu izan duguna honez gero, beronekin ez da "ta" agertzen, adibidez:

- edosein lekun topa senki
  (edozein lekutan topa zenezake)

- elise dao edosein errin
  (eliza dago edozein herritan)

**Denbora:**

- ume se urtetan yayo san?
  (umea ze urtetan jaio zen?)

- se egunetan martxaten dosu?
  (ze egunetan alde egiten duzu?)

- se egunetan egon sintzen?
  (ze egunetan egon zinen?)

- senbet egunen egon sara kanpon?
  (zenbat egunean egon zara kanpoan?)

- senbet egunen egon sara klinikan?
  (zenbat egunean egon zara klinikan?)

- urte askotan esta entzun euskere
  (urte askotan ez da entzun euskara)

- amar egunen egon nas klinikan
  (hamar egunean egon naiz klinikan)

- nik berba ingo neko sortzi egunen isildu barik
  (nik berba egingo nuke zortzi egunean isildu barik)

- saspi urten medikues ibili san a
  (zazpi urtean medikuarekin ibili zen hura)

- ori urte askotan Amerikëtan on da
  (hori urte askotan Ameriketan egon da)

- lau asten gaisorik egon nas
  (lau astean gaisorik egon naiz)

- Bilbon egon nas egun gitxiten
  (Bilbon egon naiz egun gutxitan)

- egun bien on nas etorri barik
  (egun bian egon naiz etorri barik)

Ikusten denez zehaztugabeekin "ta" agertzen zaigu, zenbakiekin, ostera, ez; ez agertze honek beti ere adierazi gura du egun edo urte horiek jarraian direla, galdekariekin askozaz argiago ikusten da, izan ere, egunetarik bat aukeratu behar denean, edozein, "ta" agertzen da; baina, "zenbat" galdekariarekin jarraipena edo hobeto esanda iraupena adierazi gura denez "ta" ez da agertzen eta singularraren deklinabide bera dugu.

**Neurriak:**

- onik eta berreun metron elise dao
  (hemendik berrehun metroan eliza dago)

- senbet kilometron dao emeti Plentzi?
  (zenbat kilometroan dago hemendik Plentzia)





- berreun metron dekosu taberne
  (berrehun metroan daukazu taberna)

- emeti eun metron eron deue
  (hemendik ehun metroan eroan dute)

- eunen yon gares
  (ehunean joan gara)

- ollasko eun pesetan dao
  (oilaskoa ehun pezetan dago)

- esta ikusten eser kilometro askotan
  (ez da ikusten ezer kilometro askotan)

- edosein presiotan saltzen deue ori
  (edozein preziotan saltzen dute hori)

- eun gradun iten deu irikin urek
  (ehun graduan egiten du irakin urek)

- yaurti yen amar metron
  (jaurti zuen hamar metroan)

- amar metron bota yen
  (hamar metroan bota zuen)

Neurri alorrean argiago agertzen zaigu lehen aipatukoa, jarraipena adierazi egiten denez ez da "ta" agertzen; gainerako kasu guztietan antzeko arazoa dugunez taxuera bera mantenduko dugu materiala emateko.

## 5.2.14. NORA

Kasu honen ezaugarria "-RA" dugu:

| Mug. | Sing. | Plu. |
|---|---|---|
| etzetara<br>basotara | etzera<br>basora | etzetara<br>basotara |

**Lekua:**

- senbet basotara yon sara?
  (zenbat basotara joan zara?)

- se etzetara yon sara?
  (ze etxetara joan zara?)

- yon nas iru etzetara
  (joan naiz hiru etxetara)

- leku askotara yon dire
  (leku askotara joan dira)

- mendi gitxitera yon dire
  (mendi gutxitara joan dira)

**Denbora:**

- sei urterarten estos elisara
  (sei urtera artean ez doaz elizara)

- amasei urterarten daos eskolan
  (hamasei urtera artean daude eskolan)

- lau urterik amalaure daos eskolan
  (lau urterik hamalaura daude eskolan)





- nik amasortzi urterarten euskere
  (nik hamazortzi urtera artean euskera)

- onik lau astera yon ber dot
  (hemendik lau astera joan behar dut)

- nok daki onik eta senbet urtera
  (nork daki hemendik eta zenbat urtera)

- onik eta egun gitxire etorko da ostabere
  (hemendik eta egun gutxira etorriko da ostabere)

Adibideotan agertu denez "arten"ekin aurrekoari "ra" eransten zaio, hona hemen beste adibide batzu:

- egon gare iruretararten
  (egon gara hiruretara artean)

- bostetararten eon dire berbas
  (bostetara artean egon dira berbaz)

- bier arten emen eongo da
  (bihar artean hemen egongo da)

## 5.2.15. NONDIK

Kasu honen ezaugarria "-TI" dugu:

| Mug. | Sing. | Plu. |
|---|---|---|
| etzetati<br>basotati | etzeti<br>basoti | etzetati<br>basotati |

Denbora alorrean ondoko adibideotan ikusten den legez beste kasu marka bat erabiltzen dela esan dezakegu, izan ere, ezaugarriak erabat desberdinak dira:

- atzorik ona estot ikusi
  (atzorik hona ez dut ikusi)

- ordurik ona esta etorri
  (ordurik hona ez da etorri)

- amakatarik amabitarten lo on da
  (hamaiketarik hamabiak artean lo egon da)

- ori dao olan gastetarik
  (hori dago hola gaztetarik)

- ondik eta gabonetara ikusiko du
  (orainik eta gabonetara ikusiko dugu)

- se egunetarik ona saos emen?
  (ze egunetarik hona zaude hemen?)

- goiserik asite gauerarten bearren egon dires
  (goizerik hasita gauera artean beharrean egon dira)

- orduko egunerik estot ikusi
  (orduko egunerik ez dut ikusi)

- egun ortarik estot ikusi
  (egun horretarik ez dut ikusi)

- arik irugarren egunen ostabe ikusi neun
  (harik hirugarren egunean ostabere ikusi nuen)

Beraz, kasu honen ezaugarriak honako hauek geneuzkake:





| Mug. | Sing. | Plu. |
|---|---|---|
| -TARIK | -RIK | -TARIK |

Galdekaria "nosik" dugu eta bai erakusleak bai adberbioak kasu honen arabera desberdinak ditugu:

**Erakusleak:**

ontarik ortarik

**Adberbioak:**

onik arik

Mugagabeari dagokionez hemen ditugun kasu biek antzera funtzionatzen dute, batak leku eta neurri alorrean eta besteak denbora alorrean; adibidez:

**Lekua:**

- se etzetati etor sara?
  (ze etxetatik etorri zara?)

- etor nas iru etzetati
  (etorri naiz hiru etxetatik)

- erri askotati ibil dire
  (herri askotatik ibili dira)

- etze gitxiteti etorri dire
  (etxe gutxitatik etorri dira)

- edosein lekuteti dabiltzes
  (edozein lekutatik dabiltza)

**Neurria:**

- senbet metroti yausi da?
  (zenbat metrotik jausi da?)

- yausi in da amar metroti
  (jausi egin da hamar metrotik)

**Denbora:**

- lau urterik amalaure daos eskolan
  (lau urterik hamalaura daude eskolan)

- senbet urterik asten dire eskolara?
  (zenbat urterik hasten dira eskolara?)

## 5.2.16. NORAKO

Hau ez da benetako kasu bat "nora" kasuaren gainean eraikinekoa baino, hari "-KO" atzizkia erantsita:

| Mug. | Sing. | Plu. |
|---|---|---|
| etzetarako<br>basotarako | etzerako<br>basorako | etzetarako<br>basotarako |

Hona hemen beronen erabileraren adibide batzu:

- koyu du autobuse Lekeitiorako
  (hartu dugu autobusa Lekeitiorako)

- ori da etzerako bide
  (hori da etxerako bidea)





Denbora alorrean lehen aitatuko arazo bera daukagu, adibidez:

- iru egunerako ogi artu du
  (hiru egunerako ogia hartu dugu)

- senbet urterako erosi deude?
  (zenbat urterako erosi dute?)

- egun askorako ardau ekarri du
  (egun askorako ardoa ekarri dugu)

- onegas egun gitxiterako deku
  (honekin egun gutxitarako daukagu)

- edosein egunerako balio deu orrek
  (edozein egunerako balio du horrek)

- bearra se egunetarako da?
  (beharra ze egunetarako da?)

- senbet egunerako dao bearra?
  (zenbat egunerako dago beharra?)

- yon dire Bilbora amar egunerako
  (joan dira Bilbora hamar egunerako)

## 5.2.17. NORANTZA

Kasu honen ezaugarria "-RANTZA" dugu:

| Mug. | Sing. | Plu. |
|---|---|---|
| etzetaranmtza<br>basotarantza | etzerantza<br>basorantza | etzetarantza<br>basotarantza |

## 5.2.18. NORAÑO

Kasu honen ezaugarria "-RAÑO" dugu:

| Mug. | Sing. | Plu. |
|---|---|---|
| etzetaraño<br>basotaraño | etzeraño<br>basoraño | etzetaraño<br>basotaraño |

Batzutan "-RAÑO"ren ordez "arten" ere erabiltzen da, adibidez:

- nongo etzerarten yon dires?
  (nongo etxeraino joan dira?)

- yon dires iru basotararten
  (joan dira hiru basotaraino)

## 5.2.19. NONGO

Hau ez dirudi benetako kasua denik, aitzitik atzizki bat baino ez dela esan dezakegu; gainerako kasuetarik gehienei erants dakiekeena. Arazo nagusia mugagabearen "ta" agertzea edo ez geneukake; kasu hau aditz lagun bati erants dakiokē, orduan "ta" agertuko zaigu, baldin eta oinarriko aditz lagun horretan "ta" sortzen bada; beste batzutan, izen sintagma bati erants dakioke, honelako kasuetan egundo ere ez zaigu "ta" agertuko.

Hona hemen adibide batzu, oinarrian Aditz Laguna (AL) egonda edo Izen Sintagma (IS) egonda:

IS+KO

- senbet ateko da sure etze?
  (zenbat atekoa da zure etxea?)





- senbet urteko da ori ume?
  (zenbat urtekoa da ume hori?)

- etorri da umetxu bet lau urteko
  (etorri da umetxo bat lau urtekoa)

- ekar deude eun kiloko arri bet
  (ekarri dute ehun kiloko harri bat)

- urte gitxiko ardau da au
  (urte gutxiko ardoa da hau)

- beye bat saldu deude esne askoko
  (behi bat saldu dute esne askokoa)

- saldu deude iru urteko ardaua
  (saldu dute hiru urteko ardoa)

- imin deue bentane kristal biko
  (ipini dute leihoa kristal bikoa)

AL+KO

- se etzetako da sure andre?
  (ze etxetakoa da zure andrea?)

- mendi askotako lurre esta ona
  (mendi askotako lurra ez da ona)

- orrek senbet erritekok dire?
  (horiek zenbat herritakoak dira?)

- erri gitxitekok dire orrek
  (herri gutxitakoak dira horiek)

Bestalde kasu marka hau aditzondoei ere erants dakieke "nosko" galdekariari erantzuteko, adibidez:

- au isen da gaurko
  (hau izan da gaurko)

- bierko eongo da emen
  (biharko egongo da hemen)

- arrastireko da au
  (arratsalderako da hau)

# 6. ADITZA

## 6.1. ASPEKTOA

### 6.1.1. Aspekto perfektoa

Aspekto honen ezaugarriak lexikoak berak ematen dizkigu, izan ere, hizkaleraz arrunta denez "i" eta "tu" ez dira galtzen. Hala ere, "i"z amaitukoekin sinkopa fenomenoak sano sarri gertatzen dira, adibidez:

| | |
|---|---|
| etor nas | ikus du |
| ekar dot | eros deu |

### 6.1.2. Aspekto ez perfektoa.

Beronen ezaugarririk nabarmenena "ten" dugu, adibidez:

eroten
etorten
iten
ekarten

Batzutan, ostera, "ten" agertu beharrean "tan" agertzen da, adibidez:

ulertan
gustetan

Azkenik "tu" morfema osorik daukatenekin "tzen" ere agertzen da, adibidez:

saltzen
lotzen

## 6.1.3. Gero aldiko aspektoa.

Aspekto honen ezaugarria "ko" dugu, hala ere, "n"z amaituko aditzekin beronen aldakina den "go" erabiltzen da, adibidez:

| | |
|---|---|
| ekarko | egongo |
| etorko | emango |
| ikusko | ingo |

## 6.1.4. Moduak, aldiak eta aspektoa.

Modu ezberdinen arabera aldiak eta aspektoak konbinatuaz honako aukerok dauzkagu:

TU + ORAINA

- saldu deu ogi
  (saldu du ogia)

- belu etor nas
  (belu etorri naiz)

- orrek afari eron deu
  (horrek afaria eroan du)

TU + IRAGANA

- ori belu etor san
  (hori belu etorri zen)





- ak beran etze saldu yen
  (hark beraren etxea saldu zuen)

- orrek dana eroyen
  (horrek dena eroan zuen)

TTEN + ORAINA

- orrek saltzen deu ganadu
  (horrek saltzen du ganadua)

- belu etorten da
  (belu etortzen da)

- eroten deu diru
  (eroaten du dirua)

TTEN + IRAGANA

- orrek erotesen ardik
  (horrek eroaten zituen ardiak)

- arek saltzen yen okele
  (hark saltzen zuen okela)

- ori etorten san sarri
  (hori etortzen zen sarri)

Aspekto hau maiztasuna adierazteko erabiltzen da, hots, hasia baina amaitu barik dagoen ekintza adierazteko; ekintza amaitua dela adierazi gura izanez gero, baina behin baino gehiagotan egin dela adierazteko "izan" erabiltzen da, adibidez:

- ori sarri etorte isen da
  (hori sarri etortzen izan da)

- orrek amagas ite isen deu berba
  (horrek amarekin egiten izan du berba)

O + ORAINA

- orrek salduko deu etze
  (horrek salduko du etxea)

- seňe etorko da bakarrik
  (seina etorriko da bakarrik)

- orrek erongo deue beskari
  (horiek eroango dute bazkaria)

KO + IRAGANA

- etorko san
  (etorriko zen)

- ekarko yen dusti
  (ekarriko zuen guztia)

Honako taula honetan indikatiboaren aukera guztiak ematen ditugu:

| Aspektoak | Aldiak | |
|---|---|---|
| | Oraina | Iragana |
| TU | ekar deu | ekar yen |
| TEN | ekarten deu | ekarten yen |
| TUKO | ekarko deu | ekarko yen |

BALDINTZAK

*Errealak:* (-TEN/BA-... -KO)

- etorten bada arin ikusiko du
  (etortzen bada arin ikusiko dugu)





- ori ekarten baostesu erongo dot etzera
  (hori ekartzen badidazu eroango dut etxera)

- espadeue erosten esin du eron
  (ez badute erosten ezin dugu eroan)

- espadeue ikusten estotze emongo
  (ez badute ikusten ez diote emango)

Aditz trinkoekin ere erabil daiteke, adibidez:

- espadakarde ogi eskengi afaririk yan
  (ez badakarte ogia ez genezake afaririk jan)

Baldintza moeta hau iraganeraz ere erabil daiteke, aldia aldatuaz, jakina; adibidez:

- ikusi ingo gendun etzera yon bagintzen
  (ikusi egingo genuen etxera joan baginen)

- basora yongo gintzen denpora ona egon basan
  (basora joango ginen eguraldi ona egon bazen)

*Irrealak:* (-KO/BA-...-KO/KE-)

- banenko diru asko gustako lekit ondo bisite
  (baneuka diru asko gustatuko litzaidake ondo bizitzea)

- yongo baletikes mendire galdu ingo letikes
  (joango balira mendira galdu egingo lirateke)

- ori baletike euskaldune eongo letike gues
  (hori balitz euskalduna egongo litzateke gurekin)

- suk ekarko basenko ori nik erongo nenko
  (zuk ekarriko bazenu hori nik eroango nuke)

Baldintza aurrekoa iragana izanez gero indikatibo iragana baino ez da erabiltzen, adibidez:

- oin eskenko yon ber atzo yon bagintzen
  (orain ez genuke joan behar atzo joan baginen)

- eskenko eukiko berrisenik atzo erosi bagendun
  (ez genuke eukiko beharrizanik atzo erosi bagenuen)

Ikusten denez "ke" baldintza aurrekoari ere eransten zaio.

SUBJUNTIBOA

Aior honetan orain aldia baino ez dela erabiltzen esan dezakegu; dena dela, subjuntiboak funtzio bat baino gehiago ere bete ditzake, adibidez:

*Konpletibo* gisa:

- aitek goisetik etorri naiten gure deu
  (aitak goizetik etor nadin gura du)

- nik ona etor saitesen gure dot
  (nik ona etor zaitezen gura dut)

- nik gure dot umeri beskari gusta dakien
  (nik gura dut umeei bazkaria gusta dakien)

- orrek gure deude emen egon gaitesan
  (horiek gura dute hemen egon gaitezen)

Aginterarekin batera agertuz gero subjuntiboari "-ela" eransten zaio, adibidez:

- esayosu itxeron deistela besok sabalik
  (esaiozu itxeron diezadala besoak zabalik)





- esayosu etzera eron dila
  (esaiozu etxera eroan dezala)

- esayok orreri datorrela
  (esaiok horri datorrela)

*Final* gisa:

- kosisu ori seňe yausi esteiten
  (har ezazu sein hori jaus ez dadin)

- ate isi in dot otzitu esteiten
  (atea itxi dut hoz ez dadin)

"bildur izan" aditzarekin:

- dekot bildurre etor daitesen
  (daukat bildurra etor daitezen)

- orrek deko bildurre kita esdeyen
  (horrek daukat bildurra ken ez diezaioten)

Subjetuak kideak izanez gero ezin erabiliko litzateke subjuntiboa beronen ordez "-teko" nominalizazioa erabiltzen da, adibidez:

- deko bildurre yausteko
  (dauka bildurra jausteko)

*Aginteraren ordez:*

- datorrela!
  (datorrela!)

- ekar deila!
  (ekar dezala!)

- estitela yon!
  (ez dadila joan!)

- es deila yan!
  (ez dezala jan!)

AGINTERA

Agintera bai aditz trinkoekin bai perifrastikoekin egin daiteke, eskuarki esaldiaren hasieran agertzen delarik, adibidez:

- ekarrisek orrek giltzek
  (ekar itzak giltza horiek)

- koyuik ori señe
  (har ezak sein hori)

- sos etzera se an topako su
  (zoaz etxera ze han topatuko duzu)

AHALEZKOA

Ezin gauza handirik esan dezakegu modu honi buruz; alde batetik, batuari aitzi, aldi bi baino ez dagoela oraina eta iragana, adibidez:

- ni yon nentike etzera
  (ni joan ninteke etxera)

- gu yon gentikes basora
  (gu joan gaitezke basora)

- bier etor nentike
  (bihar etor ninteke)

- atzo ekar neunken beskari
  (atzo ekar nezakeen bazkaria)





- ama sartu euken elisan
  (ama sar zitekeen elizan)

Beste alde batetik, ezezko esaldietan askotan "ezin" erabili barik ahalezkoa bera erabiltzen da, adibidez:

- eneitzu esan ori
  (ez niezazuke esan hori)

- guk ya es gengi in beste euskerarik
  (guk ja ez genezake egin beste euskararik)

- euskere eletike akaba
  (euskara ez liteke amai)

AHALEZKO BALDINTZAK

Hauek baldintzok gutxitan bada ere lantzean behin entzun daitezke; hona hemen adibide batzu:

- gaur euri in balei!
  (gaur euria egin baleza!)

- gaur denpora ona in balei!
  (gaur eguraldi hona egin baleza!)

- orrek ekar balei yateko!
  (horrek ekar baleza jatekoa!)

## 6.2. ADITZ LAGUNTZAILEAK.

Aditz laguntzaileen paradigmak emateko banaketa klasikoari jarraituko diogu, hau da:

NOR
NOR-NORI
NORK-NOR
NORK-NORI-NOR

## 6.2.1. NOR

### Indikatiboa.

| *Oraina* | *Iragana* |
|---|---|
| nas | nitzen |
| as | intzen |
| da | san |
| gara/gare/gares | gintzen/gintzesen |
| sara | sintzen |
| sare | sintzen |
| dire/dires | siren |

### Baldintzak

| *Aurrekoa* | *Ondorioa* |
|---|---|
| banentike | nentike |
| baentike | entike |
| baletike | letike |
| bagintikes | geintikes/gintikes |
| basintikes | seintikes/sintikes |
| basintikese | seintikese/sintikese |
| baletikes | leitikes/litikes |

| **Ahalezko oraina** | **Subjuntiboa** | **Agintera** |
|---|---|---|
| nentike | naiten | ai/aine[1] |
| entike | aiten | - |
| letike | daiten/diten | saites |
| gentikes | gaitesen | saitese |
| sentikes | saitesen | - |
| sentikese | saitesen | |
| letikes | daitesen | |

[1] "Aine" andrazkoekin erabiltzen da.





## 6.2.2. NOR-NORI

### Indikatiboa

*Oraina*

| NI | HURA | HAIEK |
|---|---|---|
| natzu | dat/yat | da(s)teas/yates |
| natzue | dak | dasak |
| | dana | dasena |
| | dako/yako | dakos/yakos |
| | daku/yaku | dakus/yakus |
| | datzu/yatzu | datzus/yatzus |
| | datzue/yatzue | datzues/yatzuse |
| | dake/yake | dakes/yakes |

*Iragana*

| NI | HURA | HAIEK |
|---|---|---|
| nintzun | yakiten/yaten | yakitesen/yatesen |
| nintzuen | yakion/yakon | yakiosen/yakosen |
| | yakiun/yakun | yakiusen/yakusen |
| | yakisun/yatzun | yakisusen/yatzusen |
| | yakisuen/yatzuen | yakisuesen/yatzuesen |
| | yakien/yaken | yakiesen/yakesen |

Baldintza ondorio HURA

leskit
lekio
leskigu
lekisu
lekisue
leskie

## 6.2.3. NORK-NOR

### Indikatiboa

*Oraina*

| NI | GU |
|---|---|
| nok | gosak |
| nona | gosena |
| neu | gaitus |
| nosu | gosus |
| nosue | gosues |
| neude | gaitues |

| HI | ZU | ZUEK |
|---|---|---|
| aut | saitudes | saitudese |
| au | saitu(s) | saitues |
| au | - | - |
| aude | saituese | saituese |

| HURA | HAIEK |
|---|---|
| dot | doas |
| dok | dosak |
| dona | dosena |
| deu | deitu/deitus/ditu |
| du | dus |
| dosu | dosus |
| dosue | dosues |
| deude/deue | deituse |

### Iragana

| NI | GU | ZU | ZUEK |
|---|---|---|---|
| nengin | gengisen | sengidesen | sengidesen |
| nengisun | gengiesen | sengisen | sengisen |
| nengisuen | | - | - |
| nenglen | | sengiesen | sengiesen |





| HURA | HAIEK |
|---|---|
| nendun/neun | nendusen |
| endun | endusen |
| yeun/yen | yeusen/seitusen |
| gendun | gendusen |
| sendun | sendusen |
| senduen | senduesen |
| yeuden/yeden | yedesan/situesan |

### Baldintza ondorioak

| HURA | HAIEK |
|---|---|
| neko | nekos |
| enko | enkos |
| leko | lekos |
| genko | genkos |
| senko | senkos |
| seunke | seunkes |
| leuke | eukes |

### Ahalezko oraina

| HURA | HAIEK |
|---|---|
| nengi | nengis |
| engi | engis |
| lei | leis |
| gengi | gengis |
| sengi | sengis |
| sengie | sengies |
| leiye/leide | leiyes |

### Agintera

| NI | GU |
|---|---|
| neik | geisek |
| neine | geisena |
| neisu | geisus |
| neisue | geisues |

| HURA | HAIEK |
|---|---|
| ik | isek |
| ine | isena |
| isu | isus |
| isue | isues |

## 6.2.4. NORK-NORI-NOR

### Indikatiboa

*Oraina*

| NIRI(s.) | NIRI(p.) |
|---|---|
| dostek | dostesak |
| dostena | dostesena |
| deust | deustes |
| dostesu | dostesus |
| dostesue | dostesues |
| deuste | deustes |

| GURI(s.) | GURI(p.) |
|---|---|
| dosku | doskus |
| dosu | dosus |
| dosue | dosues |
| doskue | doskues |

| ZURI(s.) | ZURI(p.) |
|---|---|
| dotzut | dotzutes/dotzues |
| dotzu | dotzus |
| datzu | datzus |
| dotzue | dotzues |

| ZUEI(s.) | ZUEI(p.) |
|---|---|
| dotzuet | dotzutes |
| dotzue | dotzues |
| datzue | datzues |
| dotzue | dotzues |





| HARI(s.) | HARI(p.) |
|---|---|
| dotzet | dotzeas |
| dotzek | dotzesak |
| dotzena | dotzesena |
| dotzo | dotzos |
| dotzu | dotzus |
| dotzesu | dotzesus |
| dotzesue | dotzesues |
| deutze | deutzes |

| HAIEI(s.) | HAIEI(p.) |
|---|---|
| dotzet | dotzeas |
| dotzek | dotzesak |
| dotzena | dotzesena |
| dotze | dotzes |
| dotzu | dotzus |
| dotzesu | dotzesus |
| dotzesue | dotzesues |
| dotze/deutze | dotzes |

*Iragana*

| NIK(s.) | NIK(p.) |
|---|---|
| neuntzen | neuntzesen |
| neuntzun | neuntzusen |
| neuntzuen | neuntzuesen |
| neuntzen | neuntzesen |

| ZUK(s.) | ZUEK(s.) | GUK(s.) |
|---|---|---|
| seusten | seusten | yatzun |
| seuntzen | seuntzeen | geuntzen/gintzen |
| sendun | senduen | yatzuen |
| seuntzeen | seuntzeen | geuntzen/gintzen |

| HARK(s.) | HAIEK(s.) |
|---|---|
| yeusten | yeusten/yesten |
| yeutzen | yeutzen |
| yeuskun | yeuskuen |

| | |
|---|---|
| yotzun | yotzuen |
| yotzuen | yotzuen |
| yeutzen | yeutzen |

Lekukoetarik batek indikatiboaren ordez subjuntibozko adizkiak birritan erabili zituen, hona hemen:

- nik emon neyon lurre
  (nik eman niezaion lurra)

- guk emon geyon orreri ori asto
  (guk eman geniezaion horri asto hori)

**Baldintza ondorioak.**

| HARI(s.) | HARI(p.) |
|---|---|
| neskio | neskios |
| leskio | leskios |
| geskio | geskios |
| seskio | seskios |
| seskie | seskies |
| leskie | leskies |

**Ahalezkoa.**

| HARI(s.) | HARI(p.) |
|---|---|
| neiyo | neiyos |
| leiyo | leiyos |
| gengio | gengios |
| sengio | sengios |
| sengie | sengies |
| leiye | leiyes |





## 6.3. ADITZ TRINKOAK

Atal honetan aditz trinkoen orain aldiak baino ez ditugu ematen; izan ere, iraganak ez dira erabiltzen, adibidez:

- orrek esteu yakin euskere
  (horrek ez du jakin euskara)

- nik enendun dirurik auki
  (nik ez nuen dirurik eduki)

| EGON | JOAN |
|---|---|
| nau/nao | no |
| ao | o |
| dau/dao | do |
| gaus/gaos | gos |
| saus/saos | sos |
| sause/saose | sose |
| daus/daos | dos |

| ETORRI | IBILI |
|---|---|
| nator | nabil |
| ator/atorrena | abil |
| dator | dabil |
| gatos | gabiltzes |
| satos | sabiltzes |
| satose | sabiltzese |
| datos | dabiltzes |

EDUKI

| HURA | HAIEK |
|---|---|
| dekot | dekoas |
| dekok | dekosak |
| dekona | dekosena |

| | |
|---|---|
| deko | dekos |
| deku | dekus |
| dekosu | dekosus |
| dekosue | dekosues |
| deuke | deukes |

Eduki aditzak NORK-NORI-NOR saileko adizkiak ere onartzen ditu, adibidez:

- entzunte dekotzet nik estakit pa aiteri
  (entzunda daukakiot nik ez dakit ba aitari)

- amen dekostesu
  (hemen daukakidazu)

JAKIN

| HURA | HAIEK |
|---|---|
| dakit | dakiteas |
| dakik | dakixek |
| dakine | dakixena |
| daki | dakix |
| dakiu/dakidu | dakius |
| dakixu | dakixus |
| dakixue | dakixues |
| dakie | dakies |

Honek datiboa ere onartzen du, adibidez:

- badakitzut (nik-zuri)

EROAN

| HURA | HAIEK |
|---|---|
| darot | daroas |
| darok | darosak |





| | |
|---|---|
| darona | darosena |
| daro | daros |
| daru | darous |
| darosu | darosus |
| darosue | darosues |
| dareude | darodes |

EKARRI

| HURA | HAIEK |
|---|---|
| dakart | dakardeas |
| dakarrek | dakasak |
| dakarrena | dakasena |
| dakar | dakas |
| dakargu/dakardu | dakargus/dakardus |
| dakasu | dakasus |
| dakasue | dakasues |
| dakarde | dakardes |

ERABILI

| HURA | HAIEK |
|---|---|
| dabilt | dabildeas |
| dabilek | dabiltzesak |
| dabilena | dabiltzesena |
| dabil | dabiltzes |
| dabildu | dabildus |
| dabiltzu | dabiltzus |
| dabiltzue | dabiltzues |
| dabilde | dabildes |

| ESAN | ERITZI |
|---|---|
| dinot | deretxet |
| dinok | deretxok |
| dinona | deretxona |

| | |
|---|---|
| dino | deretxo |
| dinogu | deretxu |
| dinosu | deretxesu |
| dinosue | deretxesue |
| dinoude | deretxe |

ERION

Aditz hau fosildurik dagoela esan dezakegu eta hirugarren pertsona baino ez da erabiltzen, adibidez:

- dariola dao
  (dariola dago)

- mokok dariola dao
  (mokoak dariola dago)

ERDU

Aditz hau ere fosildurik dago gaur egun, inoiz jokatu bada ere, agintera baino ez da erabiltzen, adibidez:

erdu
erduse

EUTSI

Aditz honen adizkiak aginteran baino ez dira erabiltzen:

autzo/autzona





## 6.3.1. Aditzen orainaldia.

Aditzen orainaldi puntukariari dagokionez lau aditz talde bereiztu beharko genuke:

a) aditz trinkoak

Oraintsu ikusi dugu zeintzuk diren hemen erabiltzen direnak, aditz hauek oraina era jokatuaz egiten dute.

b) Izan aditza bigarren osagaitzat duen aditz taldea, adibidez:

| | |
|---|---|
| ber isen | balio isen |
| gure isen | bisi isen |

Aditz hauek ez daukate ezelako markarik oraina egikeran, honako adibideotan ikus daitekeen legez:

- yon ber dot etzera
  (joan behar dut etxera)

- orrek gure deu eskondu
  (horrek gura du ezkondu)

- ori esta emen bisi
  (hori ez da hemen bizi)

- orrek estost balio
  (horrek ez dit balio)

c) "egin"en bidez egiten den aditz taldea, hauek oraina egikeran lehen osagaiari atzizki bat erantsiaz egiten dute, adibidez:

- orrek berbas daos
  (horiek berbaz dagoz)

- señe lo dao
  (seina lo dago)

- negarres dao señe
  (negarrez dago seina)

- ori barreka dao
  (hori barreka dago)

- ori bearren dao
  (hori lanean dago)

d) Azkenik gainerako guztiak dauzkagu; hauek puntukaria "egon" laguntzailetzat hartuta egiten dute, aditzari "-TAN" eransten zaiola, adibidez:

- afaltan gaos
  (afaltzen gagoz)

- etorri nasenen beskaltan on da
  (etorri naizenean bazkaltzen egon da)

- bier datorrenen akabatan ongo da
  (bihar datorrenean amaitzen egongo da)

- baso dao erretan
  (basoa dago erretzen)

## 6.4. TRATAMENDUAK.

### 6.4.1. Hikaren erabilera.

Erregistro moeta honek gero eta erabilera murritzagoa du, desagertuz doala esan dezakegu. Hona hemen, esaldi enuntziatiboez ostean, zein kontestotan ager daitekeen:





**Galderetan:**

- ser yakardek orrek?
  (zer diakartek horiek?)

- nora yosak orrek?
  (nora dioazek horiek?)

- lagunek etor dosak?
  (lagunak etorri dituk?)

- orrek etze saldu yedek?
  (horiek etxea saldu diate?)

**Baldintzetan:**

- belu etorriten badok afaldu barik lotuko dok
  (belu etortzen baduk afaldu barik lotuko duk)

- liburu ekarriten bayok nik leiduko yot
  (liburua ekartzen badik nik irakurriko diat)

- ona etorko baletikek beorregas ingo nekok berba
  (hona etorriko baluk berorrekin egingo nikek berba)

- orrek ekarko baliekok ogi afari yango gengok
  (horrek ekarko balik ogia afaria jango genikek)

Menpeko esaldietan ez dago joera bakarra, hots, batzutan menpeko esaldian agertzen da alokutiboa; baina, beste batzutan, ostera, ez; adibidez:

- etxok esan etorko dala
  (ez dik esan etorriko dela)

- pentzetan yot etor dala
  (pentsatzen diat etorri dela)

- estok etorri trena galdu yokelakon
  (ez duk etorri trena galdu duelako)

- ogi ekar yokena gaisorik yaok
  (ogia ekarri duena gaisorik diagok)

- etorten yakonen esango yotzet
  (etorten zaionean esango zioat)

## 6.4.2. Aditz laguntzaileen alokutiboa.

**NOR**

**Indikatiboa**

| | |
|---|---|
| *Oraina* | |
| nok | ona |
| dok | dona |
| gosak | gosena |
| dosak | dosena |
| *Iragana* | |
| nitzon | nitzena |
| son | sona |
| gintzosen | gintzesana |
| sosan | sosena |

**Baldintza ondorioa**

| | |
|---|---|
| nentikek/nentikok | nentikena |
| letikek/letikok | letikena |
| gentikesak | gentikesana |
| letikesak/letikosak | letikesana |





**NOR-NORI**

**Indikatibo oraina**

| | |
|---|---|
| HURA | |
| yatek | yatena |
| yakok | yakona |
| yakuk | yakune |
| yakek | yakena |
| HAIEK | |
| yatesak | yatesana |
| yakosak | yakosana |
| yakusek | yakusena |
| yakesak | yakesana |

**NORK-NOR**

**Indikatiboa**

| | |
|---|---|
| *Oraina* | |
| NI | |
| nayok | nayona |
| nayeek | nayena |
| HURA | |
| yot | yotena |
| yok | yona |
| yuk | yune |
| yedek/yeek | yedena |
| GU | |
| gayosak | gayosana |
| gayesak | gayesena |

| | |
|---|---|
| HAIEK | |
| yoasat | yoatesena |
| yosak | yosena |
| yusek | yusena |
| yedesak/yeesak | yedesena |

*Iragana*

| | |
|---|---|
| HURA | |
| neon | neona |
| yon | yona |
| geyon | geyona |
| yeden | yedena |
| HAIEK | |
| neyosan | neyosena |
| yosen | yosena |
| geyosen | geyosena |
| yedesan | yedesena |

Baldintza ondorioak

| | |
|---|---|
| HURA | |
| nekok | nekona |
| lekok | lekona |
| gengok | gengona |
| leukek | leukena |
| HAIEK | |
| nekosak | nekosena |
| lekosak | lekosena |
| gengosak | gengosena |
| leukesak | leukesena |





**Ahalezkoa**

| | |
|---|---|
| HURA | |
| neik | neine |
| leik | leine |
| geinkik | geinkine |
| leiyek | leiyena |

**NORK-NORI-NOR**

**Indikatibo oraina**

| | |
|---|---|
| NIRI(s.) | |
| yostek | yostena |
| yostek | yostena |
| HARI(s.) | |
| yotzet(ek) | yotzetena |
| yotzok | yotzona |
| yotzuk | yotzune |
| yotzek | yotzena |
| GURI(s.) | |
| yoskuk | yoskune |
| yoskuek | yoskuena |
| HAIEI(s.) | |
| yotzetek | yotzetena |
| yotzek | yotzena |
| yotzuk | yotzune |
| yotzek | yotzena |
| NIRI(p.) | |
| yostesak | yostesena |
| yostesak | yostesena |

| | |
|---|---|
| HARI(p.)/HAIEI(p.) | |
| yotzeas | yotzetesana |
| yotzesak | yotzesana |
| yotzusek | yotzusena |
| yotzesak | yotzesana |
| GURI(p.) | |
| yoskusek | yoskusena |
| yoskuesak | yoskuesena |

**Indikatibo iragana**

| | |
|---|---|
| NIK(s.) | |
| neuntzen | neuntzena |
| neuntzen | neuntzena |
| HARK(s.) | |
| yosten | yostena |
| yotzen | yotzena |
| yoskun | yoskune |
| yotzen | yotzena |
| GUK (s.) | |
| geuntzen | geuntzena |
| geuntzen | geuntzena |
| HAIEK(s.) | |
| yosten | yostena |
| yotzen | yotzena |
| yoskuen | yoskuena |
| yotzen | yotzena |





## 6.4.3. Aditz trinkoen alokutiboa.

| | |
|---|---|
| EGON | |
| nayok | nayona |
| yaok | yaona |
| gayosak | gayosena |
| yaosak | yaosena |
| JOAN | |
| noyok | noyona |
| yok | yona |
| goyesak | goyesena |
| yosak | yosena |
| ETORRI | |
| natorrek | natorrena |
| yatorrek | yatorrena |
| gatosak | gatosena |
| yatosak | yatosena |
| IBILI | |
| nabilek | nabilena |
| yabilek | yabilena |
| gabiltzesak | gabiltzesena |
| yabiltzesak | yabiltzesena |
| EDUKI | |
| HURA | |
| yekot | yekotena |
| yekok | yekona |
| yekuk | yekune |
| yekek | yekena |
| HAIEK | |
| yekoas | yekoasena |
| yekosak | yekosena |

| | |
|---|---|
| yekusek | yekusena |
| yekesak | yekesena |
| **JAKIN** | |
| HURA | |
| yakit/yakitek | yakitena |
| yakik | yakine |
| yakiuk | yakiune |
| yakiek | yakiena |
| HAIEK | |
| yakies | yakiesena |
| yakixek | yakixena |
| yakiusek | yakiusena |
| yakiesak | yakiesena |
| **EROAN** | |
| HURA | |
| yarot | yarotena |
| yarok | yarona |
| yaruk | yarune |
| yarek | yarena |
| HAIEK | |
| yaroas | yaroasena |
| yarosak | yarosena |
| yarusek | yarusena |
| yaresek | yaresena |
| **EKARRI** | |
| HURA | |
| yakart | yakartena |
| yakarrek | yakarrena |
| yakarduk | yakardune |
| yakarrek | yakarrena |





| | |
|---|---|
| HAIEK | |
| yakardeas | yakardesena |
| yakasek | yakasena |
| yakardusek | yakardusena |
| yakardesek | yakardesena |
| **ERABILI** | |
| HURA | |
| yabilt | yabiltena |
| yabilek | yabilena |
| yabilduk | yabildune |
| yabildek | yabildena |
| HAIEK | |
| yabildeas | yabildeasena |
| yabiltzesak | yabiltzesena |
| yabildusek | yabildusena |
| yabildesak | yabildesena |
| **ESAN** | |
| yinot | yinotena |
| yinok | yinona |
| yinuk | yinune |
| yinedek | yinedena |
| **ERITZI** | |
| yeretxetek | yeretxetena |
| yeretxek | yeretxena |
| yeretxuk | yeretxune |
| yeretxek | yeretxena |

### 6.4.4. BERORIKA.

Tratamendu honek ez du adizkirik alda erazten; egiten den gauza bakarra "zu" erabili beharrean "berori" erabiltzea da, eta beronekin batera hirugarren pertsonari dagozkion adizkiak erabiltzen dira; adibidez:

- jaune datorrela beori etzera
  (jauna datorrela berori etxera)

- beorrek ogi ekar diela
  (berorrek ogia ekar dezala)

- berori etor letike etzera
  (berori etor liteke etxera)

- beorrek in deu
  (berorrek egin du)

## 6.5. ADITZ BATZUREN ERABILERAK

### 6.5.1. "IZAN"dun aditzak

Ataltxo honetan izandun aditz batzuren erregimenak eta aspektoak ematen ditugu.

a) AL ISEN

- emeti ibili al nas
  (hemendik ibili ahal naiz)

- amak elisen sartu al yeun
  (amak elizan sartu ahal zuen)





- orrek etorri al siren oñes
  (horiek etorri ahal ziren oinez)

- suok lotu al senduen emen
  (zuek lotu ahal zenuten hemen)

Dakusagunez, erregimenari begira, bai NORK-NOR bai NOR erara agertzen da aditz iragangaitzekin. Aditz iragankorrekin, jakina, beti NORK-NOR agertuko da, adibidez:

- in aldot ori bearra
  (egin ahal dut behar hori)

- bakotxak iten deu al deuna
  (bakoitzak egiten du ahal duena)

b) ESIN ISEN

- esin nas yon etzera
  (ezin naiz joan etxera)

- esin etorko nas arin
  (ezin etorriko naiz arin)

- gaur goisen esin etorri isen nas lenao
  (gaur goizean ezin etorri izan naiz lehenago)

- esin dotzut esan ori
  (ezin dizut esan hori)

- ori esin letike isen andiao
  (hori ezin liteke izan handiagoa)

c) GURE ISEN

- orrek gure deu eskondu
  (horrek gura du ezkondu)

- bier etorri in gureko deu
  (bihar etorri egin gurako du)

- aitek gaur lenao etorri gure isen deu
  (aitak gaur lehenago etorri gura izan du)

d) GURAO ISEN

- gurao dot bier etorri
  (gurago dut bihar etorri)

- orrek gurao deu lotu
  (horrek gurago du lotu)

- nik onek doas gurao orrek baño
  (nik hauek ditut gurago horiek baino)

- gurao dot goisen arrastin baño
  (gurago dut goizean arratsaldean baino)

e) BER ISEN

- yon ber dot etzera
  (joan behar dut etxera)

- bier yon ber dot basora
  (bihar joan behar dut basora)

- gaur goisen yon ber isen dot etzera
  (gaur goizean joan behar izan dut etxera)

- ementxe egon ber deu
  (hementxe egon behar du)

- arin yon ber iseten dot
  (arin joan behar izaten dut)





- emekó isen ber deu
  (hemengoa izan behar du)

- yon in ber nas lau aste barru
  (joan egin behar naiz lau aste barru)

## 6.5.2. Era faktitiboak

Berauek ikusteko bereiztu beharra dago alde batetik "egin" aditza bigarren osagaitzat daukaten aditzak eta beste aldetik osagarri hau ez daukatenak.

"egin"dunak:

- señeri negar erain dotze
  (seinari negar eragin diote)

- orreri barre eraingo tze
  (horri barre eragingo diote)

- bear asko eraiten dotze orreri
  (behar asko eragiten diote horri)

Gainerakoak:

**Lehen aldia**

- orreri etorri erain in dotze
  (horri etorri eragin egin diote)

- amak gosetik altza in ason neu
  (amak goizetik altxa egin erazi nau)

- orreri akaba erain dotze dana
  (horri amaitu eragin diote dena)

**Gero aldia**

- dana yan asongo tze
  (dena jan eraziko diote)

- orreri etorri ason ingo utze
  (horri etor erazi egingo diote)

**Maiztasuna**

- etorri ason iten dotze orreri
  (etor erazi egiten diote horri)

- suk iten dostesu akorda ason
  (zuk egiten didazu gogora erazi)

## 6.5.3. "EGIN"dun aditzak.

Era honetako aditzak honako hauek ditugu:

lo in
bear in
negar in
barre in
berba in

Orain arte ikusten izan ditugu aditz hauen berezitasun batzu, hala nola, orainaldi puntukaria egiteko era berezia edo era faktitiboa egikeran "eragin" laguntzailea hartu behar izana salbuespenik gabe; hemen beste berezitasun bat aipatu beharrean gagoz, hots, galderak egikeran, nahi NZ galderak nahi BAI/EZ galderak, ordena aldatu beharra; adibidez:

NZ galderak:

- seitik iten deu negar señek?
  (zergatik egiten du negar seinak?)





- nok in deu barre?
  (nork egin du barre?)

- non in dosu lo?
  (non egin duzu lo?)

- noas in dosu berba?
  (norekin egin duzu berba?)

- noas in dosu behar?
  (norekin egin duzu behar?)

BAI/EZ galderak:

- ite osu bear?
  (egiten duzu behar?)

- in dosu lo etzen?
  (egin duzu lo etxean?)

- señek in deu negar?
  (seinak egin du negar?)

- in dosu berba amaas?
  (egin duzu berba amarekin?)

- in dosue barre naye?
  (egin duzue barre zenbatgura?)

## 6.6. ADITZ BATZUREN ERREGIMENAK

### 6.6.1. NOR erara egiten direnak:

- ori akordaten da bere erriaitik
  (hori gogoratzen da bere herriaz)

- enas akordaten usenaaitik
  (ez naiz gogoratzen izenaz)

- enas akordaten usenaas oin
  (ez naiz gogoratzen izenaz orain)

- enas konturetu orreas
  (ez naiz konturatu horrekin)

- asi gare bearren
  (hasi gara beharrean)

- ori loditu da
  (hori loditu da)

- sano argaldu nas
  (sano argaldu naiz)

Beste barietateetan NOR erara erabiltzen diren aditz batzu, hemen, erdararen eraginez, "eduki" aditzaren bidez erabiltzen dira; adibidez:

- egarri badekosu edan
  (egarri bazara edan)

- umek gose deko
  (umea gose da)

- logure dekot
  (logura naiz)

Bestalde, izan aditza inpertsonalak egiteko ere erabiltzen da, subjeto bakoak egiteko alegia; hona hemen "ikusi" aditzaren posibilitate guztiak erregimenari gagozkiola:

- espillun ikusi dot neure buru
  (espiluan ikusi dut neure burua)





- orrek ikusi neu
  (horrek ikusi nau)

- orrek ikusi deuste libru
  (horiek ikusi didate liburua)

- ikusten datzus bernak
  (ikusten zaizkizu bernak)

- ikusten nas?
  (ikusten naiz?)

Azken honen modukoa, subjeto bakoa edo inpertsonal gisa, honako beste hau ere daukagu:

- aspaldin esara ikusi emeti
  (aspaldian ez zara ikusi hemendik)

Izan eta egon aditzen artean ez da inongo berizketarik egiten "non" edo "zelan"en arabera, honelako kasuetan egon baino ez da erabiltzen, adibidez:

- txakurre dao kanpon
  (txakurra dago kanpoan)

- nao sutunik
  (nago zutunik)

- gaur goisen egon nas Mungien
  (gaur goizean egon naiz Mungian)

- ori eon da yesarrite
  (hori egon da jezarrita)

Izan-ek badu, bestalde, beste erabilera bat "zorian" edo horrelakoak adierazteko, adibidez:

- señe yausi ainen isen da
  (seina jausi aginean izan da)

- etorri ainen isen nas
  (etorri aginean izan naiz)

Izan eta eduki aditzen artean ere ez da bereizketarik egiten beste euskalki batzutan ez legez, kasu guztietan eduki erabiltzen da, adibidez:

- nik dekot ogi
  (nik daukat ogia)

- dekot giltze poltzan
  (daukat giltza boltsan)

- neuk euki dot ori
  (neuk eduki dut hori)

- ogi euki dot gordeta
  (ogia eduki dut gordeta)

## 6.6.2. NORK-NOR erara.

- etzera iyen dot
  (etxera igon dut)

- urten dot berandu
  (urten dut berandu)

- urek irekin deu
  (urak irakin du)





## 6.6.3. NORK-NORI-NOR erara.

- lagundu in dotzet
  (lagundu egin diot)

- aitu in dotzet orreri
  (begiratu egin diot horri)

- geitu in dotzet
  (deitu egin diot)

- txakurreri agarra dotzet
  (txakurrari oratu diot)

- oratu umeri
  (oratu umeari)

- itxeron in dotzet
  (itxaron egin diot)

- eguskiri itxaoten geuntzen
  (eguzkiari itxaroten genion)

- es ukutu orreri
  (ez ikutu horri)

- botakade emon dotzet
  (bultzatu diot)

- parkatu in dotzet
  (barkatu egin diot)

- niri segidu in deuste
  (niri jarraitu egin didate)

Honek ez du esan gura beti derrigor NORK-NORI-NOR erabili behar denik; objetoa "ri" kasu markaz markatu egiten dute aditz hauek eta horren ondorioz aditzaren NORK-NORI-NOR agertu behar da; hona hemen horietariko aditz biren posibilitateak:

AITU(begiratu)

- aitu in dotzet orreri
  (begiratu egin diot horri)

- aitukot etzen
  (begiratuko dut etxean)

- beyeri buru aitzen dako
  (behiari burua begiratzen zaio)

- aitu iten da errin
  (begiratu egiten da herrian)

DEITU

- geitu in dotzet
  (deitu egin diot)

- etzera geitukou gero
  (etxera deituko dugu gero)

- medikuri geitu dako
  (medikuari deitu zaio)

- geitu da etzera?
  (deitu da etxera?)

ERITZI

- ser deretxesu orreri?
  (zer deritzazu horri?)





- ondo deretxet
  (ondo deritzat)

Aditz hau norberaren eritzia emateko erabiltzen da, beste euskalkietan erabiltzen den "irudi"ren ordez hemen "pentza" erabiltzen da; adibidez:

- inusente pentza lei dala ori
  (leloa pentsa liteke dela hori)

INPORTA

- suri se inporta dotzu?
  (zuri zer inporta dizu?)

- niri bardin deust
  (niri berdin dit)

Inpertsonala adierazteko beste honako hau erabiltzen da:

- orrek esteko llebarik
  (horrek ez dauka lebarik)

## 6.7. FENOMENO ATMOSFERIKOAK

- euri iten deu
  (euria egiten du)

- bier ingo deu edurre
  (bihar egingo du elurra)

- euri in deu
  (euria egin du)

- emen iten deu otz andi
  (hemen egiten du hotz handia)

- emen sarri iten isen deu edurre
  (hemen sarri egiten izan du elurra)

# 7. ESALDIAREN EGITURA

Euskaraz perpaus bakunari dagokionez hiru egitura moeta bereiz dezakegu, baiezkoa, ezezkoa eta galdera; ataltxo honetan berauek ez eze berauen aldaerak ere ikusiko ditugu.

## 7.1. BAIEZKOA

Perpaus bakunetan badirudi euskararen orden logikoak aditza amaieran jartzea eskatzen duela; gure korpusean ez da beti horrela gertatzen, izan ere, itzulpenen bidez jasoko esaldietan lekukoek sarritan itzulpen literala egiten izan dute. Edozelan ere, hona hemen adibide batzu:

- ori onegi da
  (hori honegia da)

- bero lar iten deu
  (bero lar egiten du)

- mutiletarik sarrena au da
  (mutiletarik zaharrena hau da)

- intxur gitxi ekar doas
  (intxaur gutxi ekarri ditut)

- beorren ardi il da
  (berorren ardia hil da)

- orreri barre eraingo tze
  (horri barre eragingo diote)

Gauza jakina da, bestalde, aditz aurrean galdegaigunea dagoena, eta gune horretan fokalizatzen den elementua agertuko dena. Zenbait kategoriaren intentsiboak hortxe baino ezin ager dakizkiguke, adibidez:

Erakuslea:

- autxe etor da
  (hauxe etorri da)

- atxe etor letike
  (huraxe etor liteke)

- atxe etor akiun ondo
  (huraxe etorri zitzaigun ondo)

Izen orde pertsonalak:

- neuk ikus dot
  (neuk ikusi dut)

- seuk esan dosu
  (zeuk esan duzu)

- geu yon gare
  (geu joan gara)

Aditzondoak:

- antxe dao
  (hantxe dago)

- onek araxe yon dire
  (hauek haraxe joan dira)

- ortxe egon nas
  (hortxe egon naiz)





Aditza bera fokalizatuta dagoenean era bitara egiten da aditza perifrastikoa izanda edo trinkoa izanda, adibidez:

Perifrastikoak:

- gu lengo aldin asarratu in gintzen
  (gu lehengo aldian haserratu egin ginen)

- giltzek yausi in yates
  (giltzak jausi egin zaizkit)

- mutilik txikerrena bota in deude
  (mutilik txikiena bota egin dute)

- bere aitek yo in deu
  (bere aitak jo egin du)

- yausi in da amar metroti
  (jausi egin da hamar metrotik)

Aspektoa ezartzean "egin" fokalizatzaile beroni ezartzen zaio, adibidez:

-TEN

- suk iten dostesu akorda ason
  (zuk egiten didazu gogora erazi)

- etorri ason iten dotze orreri
  (etorri erazi egiten diote horri)

- orrek esetu iten neude
  (horiek ezagutu egiten naute)

- eun gradun iten deu irikin urek
  (ehun graduan egiten du irakin urak)

-TUKO

- aitak asarratu ingo letikes
  (aitak haserratu egingo lirateke)

- emon ingo tzut sano
  (eman egingo dizut sano)

- ikusi ingo gendun etzera yon bagintzen
  (ikusi egingo genuen etxera joan baginen)

- yongo baletikes mendire galdu ingo letikes
  (joango balira mendira galdu egingo lirateke)

Trinkoak:

- etorri datos etze batzuteti ona
  (etorri datoz etxe batzutatik hona)

- orti yon sos obeto emeti baño
  (hortik joan zoaz hobeto hemendik baino)

- gause asko yon dos
  (gauza asko joan doaz)

Ezezkoetan jokabide bera egiten dela esan dezakegu, adibidez:

- orrek esteu geitu bere in
  (horrek ez du deitu ere egin)

- etorri bere esta in
  (etorri ere ez da egin)

- ni kantza enas iten
  (ni nekatu ez naiz egiten)





- aistu esta iten sekule bere
  (ahaztu ez da egiten sekula ere)

Galdegaigunea dugu, bestalde, NZ berben kokagunea ere, adibidez:

- nor esan dosu etor dala?
  (nor esan duzu etorri dela?)

- noas esan dosu yon direla?
  (norekin esan duzu joan direla?)

- nor esan dosu estala etorri?
  (nor esan duzu ez dela etorri?)

- nogaitik pregunta deue?
  (norgaitik galdetu dute?)

- nok ekar deu?
  (nork ekarri du?)

- nosik ona saos emen?
  (noizik hona zagoz hemen?)

- setako in dosu au?
  (zertarako egin duzu hau?)

Orain arte fokalizatuta agertu zaizkigun kategoria guztiak lexikalak izan dira, hots, errealizazio fonetikodunak; bada, esaldi baiëzkoetan fokaliza daitekeen kategoria ez lexikal bat ere, baietza bera, hain zuzen. Horrelakoetan aditzari ez zaio "egin" eransten aditza bera bere kokagune arruntetik perpausaren haserako gunera eramaten da. Hona hemen adibide batzu:

- in dot dusti
  (egin dut guztia)

- afaldu dot
  (afaldu dut)

- etor nas
  (etorri naiz)

Aditza trinkoa denean fokalizapen hau adierazteko "ba-" eransten zaio aditzari, adibidez:

- bano
  (banoa)

- badakit selan ilena dan
  (badakit zelan astelehena den)

Beraz galdegaigunean, aditz aurrean, bi eratako kategoriak aurkit ditzakegu; lexikalak direnak A adibidean legez eta ez lexikala dena, B adibidean legez, horrelakoetan aditza bera haserako gunera eramaten dugula:

A. - nik OGI ekar dot
B. - 0 ekar dot ogi

## 7.2. EZEZKOAK.

Esaldi hauek "ez"en bidez egiten ditugu, adibidez:

- ni enas ain lodi
  (ni ez naiz hain lodia)

- enas inos egon Donostin
  (ez naiz inoiz egon Donostian)

- orrek estos inora
  (horiek ez doaz inora)

- egunokas esta etorri
  (egunokin ez da etorri)





## 7.3. GALDERAK

Galderen artean moeta bi bereiztu behar dugu; alde batetik, NZ galderak edo galdekari baten bidez egiten direnak, eta, beste alde batetik BAI/EZ (B/Z) galderak, hots, galdekaririk gabe egiten direnak. Galdegaiguneari buruz berba egikeran NZ galderak ikusi ditugu, halanda ze orain B/Z galderak ikusiko ditugu, adibidez:

- eros dosu eser?
  (erosi duzu ezer?)

- ikus dosu inor?
  (ikusi duzu inor?)

- yon dire bata batera?
  (joan dira inora?)

- gurdosu sagarrik?
  (gura duzu sagarrik?)

Erdaraz "ya" galdetuz gero ez dirudi orden aldaketarik jazotzen denik, adibidez:

- eros dosu ogi?
  (erosi duzu ogia?)

- ikus dosu telebisiño?
  (ikusi duzu telebista?)

- ekar dosu esne?
  (ekarri duzu esnea?)

- yon sara etzera?
  (joan zara etxera?)

Aditz trinkoen bidez egineko galderetan, berriz, batzutan aditza bera agertzen zaigu hasieran, baina ez kasu guztietan, adibidez:

- baikosu ogi?
  (badaukazu ogia?)

- baikosu ogirik?
  (badaukazu ogirik?)

- baikosu surik?
  (badaukazu surik?)

- ogi dekosu?
  (ogia daukazu?)

- sagarrik baikosu?
  (sagarrik badaukazu?)

## 7.4. ETE

- ser ete dino?
  (zer ote dino?)

- orrek nora te yosak?
  (horiek nora ote dioazek?)

- etorri ete da?
  (etorri ote da?)

- ekarri ete deu?
  (ekarri ote du?)

## 7.5. EI

- ementxe erote eiyeden
  (hementxe eroaten ei zuten)





- onen ganen erote eiyeden olan
  (honen gainean eroaten ei zuten holan)

## 7.6. ESKLAMATIBOAK.

SE... -EN

- ene se lodi daon ori!
  (ene ze lodi dagoen hori!)

- ene se argal daon ori!
  (ene ze argal dagoen hori!)

- se franku daon yateko!
  (ze franko dagoen jateko!)

SELASEKO...-EN

- ene selaseko bero daon!
  (ene zelako beroa dagoen!)

- selaseko bero dekun gaur!
  (zelako beroa daukagun gaur!)

SELANGO/SELAO...-EN

- selango denpora txarra dekun!
  (zelako eguraldi txarra daukagun!)

- selango otza daon!
  (zelako hotza dagoen!)

- selao denpora sargori dekun!
  (zelako eguraldi sargori daukagun!)

BA-

- bada andi ori!
  (bada handia hori!)

- bada ori gaste!
  (bada hori gaztea!)

- au bide bada luse!
  (bide hau bada luzea!)

GRASIK...-ENA

- grasik etor dana!
  (eskerrak etorri dena!)

- grasik akaba deudena!
  (eskerrak amaitu dutena!)

- grasik ekarri deudena!
  (eskerrak ekarri dutena!)

KLARO...-ENA

- klaro etor dana!
  (jakina etorri dena!)

- klaro ekar deune!
  (jakina ekarri duena!)

- klaro isengo direna!
  (jakina izango direna!)

SEGURU...-ENA

- seguru etor dana!
  (ziur etorri dena!)





- seguru ekarri deune!
  (ziur ekarri duena!)

UXELA...BA-

- uxela etorko baletike arin!
  (hobe etorriko balitz arin!)

- uxela ondo eongo baletikes!
  (hobe ondo egongo balira!)

Zenbait kasutan esklamazioetan Izen Lagunaren ohizko kokagunea aldatzen da, adibidez:

- ai seme neure!
  (ai seme neurea!)

- listo ibili seme neure!
  (zuhur ibili seme neurea!)

# 8. ESALDI KOORDINATUAK

## 8.1. KOPULATIBOAK

- ETA
- BERE
- BERE BAI
- BERE ES
- ES...ES...
- ES ESE
- ES BAKARRIK... BERE BAI

### ETA

- ori etor da basoti eta orren anaje soloti
  (hori etorri da basotik eta horren anaia solotik)

- orrek ekar deu ardau eta guk ogi
  (horrek ekarri du ardoa eta guk ogia)

- ni etzen lotu nas eta orrek orti yon dires
  (ni etxean geratu naiz eta horiek hortik joan dira)

### BERE

- itzel nao posik baye trankilo se suri bere gure dotzut
  (itzel nago pozik baina lasai ze zuri ere gura dizut)

### BERE BAI

- amak in deu beskari ta afari bere bai
  (amak egin du bazkaria eta afaria ere bai)

- il deitues ardi bi eta auntze bat bere bai
  (hil dituzte ardi bi eta ahuntz bat ere bai)

- etor dire nire lengusuk eta nire tiok bere bai
  (etorri dira nire lehengusuak eta nire osabak ere bai)

- areri ondino gure dotzet baye suri bere bai
  (hari ondino gura diot baina zuri ere bai)

**BERES**

- ume esta etorko ta aite beres
  (umea ez da etorriko eta aita ere ez)

- orrek estire etzera yongo ta bearren beres
  (horiek ez dira etxera joango eta beharrean ere ez)

**EZ...EZ...**

- nik estot salduko ez beye es idi
  (nik ez dut salduko ez behia ez idia)

- orrek esteue inoas berbarik ingo es sues es nies
  (horiek ez dute inorekin berbarik egingo ez zurekin ez nirekin)

- eskendun ikusi es plasarik es elisarik
  (ez geneuen ikusi ez plazarik ez elizarik)

- esteue ekarko es beskaririk es afaririk
  (ez dute ekarriko ez bazkaririk ez afaririk)

**ES ESE**

- alkondare es ese musturrek bere bai
  (alkondara ez eze muturrak ere bai)

- ori es ese beste bere bai gure badeu erongo deu
  (hori ez eze bestea ere bai gura badu eroango du)





**ES BAKARRIK...BERE BAI**

- ogi bakarrik esteu ekarko ardau bere bai
  (ogia bakarrik ez du ekarriko ardoa ere bai)

- ume bakarrik es ta etorko ama bere bai
  (umea bakarrik ez da etorriko ama ere bai)

## 8.2. DISJUNTIBOAK

- ALA
- EDO

**ALA**

- ser gurdosu ure ala ardau?
  (zer gura duzu ura ala ardoa?)

- ser gurdosu au ala beste?
  (zer gura duzu hau ala bestea?)

- estakit emekok badires ala Bilbokok
  (ez dakit hemengoak diren ala Bilbokoak)

**EDO**

- neu yongo nas edo ume botako ot
  (neu joango naiz edo umea botako dut)

## 8.3. DISTRIBUTIBOAK

- BAT...BESTE...
- NAI

**BAT...BESTE...**

- bat isen san Samudioko eta beste Lesamako
  (bata izan zen Zamudiokoa eta bestea Lezamakoa)

- batek ekar yen ardau ta bestek ogi
  (batak ekarri zuen ardoa eta besteak ogia)

**NAI**

- nai beye isen nai idi isen bardin
  (nahi behia izan nahi idia izan berdin)

- nai koyu nai oratu bietara
  (nahi koju nahi oratu bietara)

- mile gause esan leis nai batera nai bestera
  (mila gauza esan litezke nahi batera nahi bestera)

- andi nai txikerra bardin da
  (handia nahi txikia berdin da)

- etzen nai kanpon beti dao berbas
  (etxean nahi kanpoan beti dago berbaz)

- barrun nai kanpon bero andi iten deu
  (barruan nahi kanpoan bero handia egiten du)

- etzen nai kanpon beti iten deu euskere
  (etxean nahi kanpoan beti egiten du euskeraz)





## 8.4. ADBERTSATIBOAK

- BAYE
- OSTERA
- OSTEN
- BAÑO
- BARIK
- BERREN
- ESEN
- ALDE BATETI... BAYE/ETA BESTE ALDETI...
- ALAN TA DUSTI BERE

**BAYE**

- esan deu etorko dala baye nik estot sinestuten
  (esan du etorriko dela baina nik ez dut sinisten)

- denpora ona dao baye gauen euri in ber deu
  (eguraldi ona dago baina gauean euria egin behar du)

**OSTERA**

- txakurre baltza da katu ostera suri
  (txakurra beltza da katua, ostera, zuria)

**OSTEN**

- etzeti urteten dotenen bai osten ez
  (etxetik urteten dudanean bai ostera ez)

**BAÑO**

- ori esta berde asule baño
  (hori ez da berdea urdina baino)

- ori esta emeko Butroiko baño
  (hori ez da hemengoa Butroikoa baino)

- etzen estao ama baño
  (etxean ez dago ama baino)

- estoas ekarri bi baño
  (ez ditut ekarri bi baño)

**BARIK**

- inusentekerik esan barik bestela isilik basengos
  (lelokeriak esan barik bestela isilik bazengoz)

- eroisu ausi barik
  (eroaizu hautsi barik)

- lo in barik dao seĥe
  (lo egin barik dago seina)

**BERREN**

- lengusu etor berren anaje etor san
  (lehengusua etorri beharrean anaia etorri zen)

- berakatzak ekarri berren ekar situsen kinpullek
  (berakatzak ekarri beharrean ekarri zituen kinpulak)

- oñes yon berren sos trenen
  (oinez joan beharrean zoaz trenez)

- inusentekerik esan berren obeto egongo sentikes isilik
  (lelokeriak esan beharrean hobeto egongo bazina isilik)

- etzen yan berrren kanpora yongo gare
  (etxean jan beharrean kanpora joango gara)





- gorantza yon berren eskoarantza sos
  (gorantz joan beharrean eskumarantz zoaz)

**ESEN**

- danak etor dire ori isen esen
  (denak etorri dira hori izan ezean)

- danak yon dires nebe isen esen
  (denak joan dira neba izan ezean)

**ALDE BATETI...BAYE/ETA BESTE ALDETI**

- alde bateti dekot bildurre baye beste aldeti yongo nentike
  (alde batetik daukat bildurra baina beste aldetik joango nintzateke)

- alde bateti gurdeu yon ta beste aldeti esteko kotxerik
  (alde batetik gura du joan eta beste aldetik ez dauka kotxerik)

**ALAN TA DUSTI BERE**

- iruretan etorko dire baye alan ta dusti bere berandu isengo da
  (hiruretan etorriko dira baina hala ta guztiz ere berandu izango da)

- etorko dire kotxen baye alan ta dusti bere estire elduko sasoireko
  (etorriko dira kotxez baina hala ta guztiz ere ez dira helduko sasoirako)

# 9. NOMINALIZAZIOAK.

-TE
-TEK
-TEARRIK
-TEARREN
-TERIK
-TEAS
-TEKO
-TEKO LEKUN
-TEKON
-TEKOTAN
-TEN

Ataltxo honetan aditz izena sortzeko erabiltzen den "-TE" ezarri ondoren beronen deklinabidea eta erabilerak ikusiko ditugu.

**-TE**

Berau kokagune desberdin bitan ager dakiguke, hots, subjetuaren kokagunean eta objetuarenean.

*Subjetua:*

- umeri olgete gustaten dake
  (umeei olgatzea gustatzen zaie)

- ori esate esta ona
  (hori esatea ez da ona)

- mendin ibilte ona da
  (mendian ibiltzea ona da)

- aistu in yat ate iste
  (ahaztu egin zait atea ixtea)

- orreri ondo yate gustatzen dake
  (horiei ondo jatea gustatzen zaie)

- amari gustetan dako etzen yate
  (amari gustatzen zaio etxean jatea)

*Objetua:*

- itxi in deude gari eraite
  (utzi egin dute garia eraitea)

- orrek fumate itxi in deu
  (horrek fumatzea utzi egin du)

- gurdeue emen egote
  (gura dute hemen egotea)

**-TEK**

- ori itek esteu balio esetarako
  (hori egiteak ez du balio ezertarako)

- ur otza edatek gatx in leitzu
  (ur hotza edateak gatx egin liezazuke)

**-TEARRIK**

- lar prisas ibiltearrik yausi in da
  (lar presaz ibiltzeagatik jausi egin da)

- yon in dire afari yan estearrik
  (joan egin dira afaria jan ez teagatik)





Udondo auzoan ondoko aldakin hau ere badago:

- afaldu esteitearrik yon in dires
  (afaldu ez teagatik joan egin dira)

- yaten du berdure loditu esteitearrik
  (jaten dugu berdura loditu ez teagatik)

- jenerok ondo in esteitearrik aitu oin selan daosen
  (gauzak ondo egin ez teagatik begira orain zelan dagozen)

**-TEARREN**

- afaldu estearren yon dire
  (afaldu ez tearren joan dira)

- posik nao su ikustearren
  (pozik nago zu ikustearren)

**-TERIK**

- etxat suerta ikusterik
  (ez zait suertatu ikusterik)

**-TEAS**

- nao posik emen eoteas
  (nago pozik hemen egoteaz)

**-TEKO**

*Konpletiboa:*

- esan dot yoteko
  (esan dut joateko)

- esan dotzut beskari ekarteko
  (esan dizut bazkaria ekartzeko)

- esan dotzut isilik eoteko
  (esan dizut isilik egoteko)

- estot agindu ekarteko
  (ez dut agindu ekartzeko)

*Finala:*

- ori ekar dotzut suk eroteko
  (hori ekarri dizut zuk eroateko)

- alegine in ber du arin akabateko
  (ahalegina egin behar dugu arin amaitzeko)

- emen esteku eser yateko
  (hemen ez daukagu ezer jateko)

- au erosi dot umeri emoteko
  (hau erosi dut umeari emoteko)

- ia akordaten basara erosteko
  (ia gogoratzen zaren erosteko)

*Izen lagun gisa:*

- yosteko makine apurtu in da
  (josteko makina apurtu egin da)

- etzera yoteko gogo euki dot
  (etxera joateko gogoa eduki dut)





*Aditzondo gisa:*

- ori dao iteko
  (hori dago egiteko)

- etorteko yaok
  (etorteko diagok)

**-TEKO LEKUN**

- ori esateko lekun "bear" esaten du
  (hori esateko lekuan "behar" esaten dugu)

**-TEKON**

- egurrek ekartekon yon nok
  (egurrak ekartzekotan joan nauk)

**-TEKOTAN**

- txarto itekotan oba itxi
  (txarto egitekotan hobe utzi)

- bier yotekotan dusti batu ber da
  (bihar joatekotan guztia batu behar da)

**-TEN**

- kantzata nao ya begire eoten
  (nekatuta nago ja begira egoten)

- bano etzera beskaltan
  (banoa etxera bazkaltzen)

- ama ikusten etor nas
  (ama ikusten etorri naiz)

- akorda nas erosten
  (gogoratu naiz erosteko)

- kantzata nao bedarra ebaiten
  (nekatuta nago belarra ebakitzen)

- orrek badaki kantetan
  (horrek badaki kantatzen)

- ori atrebidu in da koyuten
  (hori ausartu egin da hartzen)

- pasetan itxi neude
  (pasatzen utzi didate)

- beskaltan emon deuste
  (bazkaltzen eman didate)

- orrek estudiaten segiten deu
  (horrek estudiatzen segitzen du)

- ori gatxa da yakiten
  (hori zaila da jakiten)

- ori fasile da iten
  (hori erraza da egiten)

- orrek txistu yoten ikis deu
  (horrek txistua jotzen ikasi du)

- irekatzi dotzet iten
  (irakatsi diot egiten)

- asi de yaten
  (hasi da jaten)





- imin dot beskari berotan
  (ipini dut bazkaria berotzen)

- lagundu dotzet akabaten
  (lagundu diot amaitzen)

- koi deue lapurretan
  (harrapatu dute lapurretan)

- lotu da afaltan
  (lotu da afaltzen)

**EZEZKO NOMINALIZAZIOAK**

- ibili este da txarra
  (ibili ez tea da txarra)

- afaldu esteitearrik yon in dires
  (afaldu ez teagatik joan egin dira)

- yaten du berdure loditu esteitearrik
  (jaten dugu berdura loditu ez teagatik)

- buruko mine ematen deu ondo ikusi estek
  (buruko mina ematen du ondo ikusi ez teak)

# 10. KONPLETIBOAK

- ELA
- ENIK
- ENA
- SELAN...-EN
- EN (zehar galdera)
- BA (zehar galdera)
- A
- SE... -ELA
- ELAKO

Atal honen hasieran -ELA, -ENIK eta -ENA atzizki txertatzaileen funtzionamendua eta hedadurak mugatzen ahaleginduko gara. Atzizkiok hirurok menpeko perpausa txertakeran berau perpaus nagusiaren objetu bihur erazten dute.

Berauen funtzionamendua ikusteko baiezko, ezezko, baiezko galdera eta ezezko galdera egiturak kontutan hartuko ditugu.

**-ELA**

*A- Baiezkoetan:*

- emen ikusten da jente asko dabilela
  (hemen ikusten da jende asko dabilela)

- esan dotzut txarto daola olan ite
  (esan dizut txarto dagoela holan egitea)

- esan deu etorriko dala
  (esan du etorriko dela)

- esan deu ekarko deula
  (esan du ekarriko duela)

- pentzaten dot etor dala
  (pentsatzen dut etorri dela)

- pentza lei yan deudela
  (pentsa liteke jan dutela)

- esan deude bier datosela
  (esan dute bihar datozala)

- entzun dot txarto daola
  (entzun dut txarto dagoela)

- estela etorko esan deu
  (ez dela etorriko esan du)

- esteule ekarko esan deu
  (ez duela ekarriko esan du)

- akorda in yat seuk erosi dosule
  (gogoratu egin zait zeuk erosi duzula)

*B- Ezezkoetan:*

- estot esan etor dala
  (ez dut esan etorri dela)

- eneun pentzako olan isen ber dala
  (ez nuen pentsatuko holan izan behar dela)

- estot ikusi afaririk yan deule
  (ez dut ikusi afaririk jan duela)

- enas konturetu estaola emen
  (ez naiz konturatu ez dagoela hemen)

- estotzut igerri emeko sarela
  (ez dizut igarri hemengoa zarela)





- estot entzun gaisorik daola
  (ez dut entzun gaisorik dagoela)

- estot yakiten isen emeko dala
  (ez dut jakiten izan hemengoa dela)

*C- Baiezko galderak:*

- etor diela esan dosu?
  (etorri direla esan duzu?)

- bier datosela entzun dosu?
  (bihar datozela entzun duzu?)

- ikus dosu jente asko daola?
  (ikusi duzu jende asko dagoela?)

*D- Ezezko galderak:*

- erosi in dotela estotzut esan, ala?
  (erosi egin dudala ez dizut esan, ala?)

- neuk ekarko otela enotzun esan atzo?
  (neuk ekarriko dudala ez nizun esan atzo?)

- estosu pentzetan etorko dala?
  (ez duzu pentsatzen etorriko dela?)

- esteue esan akaba deuela?
  (ez dute esan amaitu dutela?)

**-ENIK**

*A- Ezezkoak:*

- estot pentzetan etorko danik
  (ez dut pentsatzen etorriko denik)

- estot esan etor danik
  (ez dut esan etorri denik)

- estot pentzetan ekar deudenik
  (ez dut pentsatzen ekarri dutenik)

- elei pentza euririk ingo deunik
  (ez liteke pentsa euririk egingo duenik)

**-ENA**

*A- Baiezkoa*

- suk badakisu ori estana euskere
  (zuk badakizu hori ez dena euskara)

- badaki txarra dana
  (badaki txarra dena)

- igerri otzut emeko sarena
  (igarri dizut hemengoa zarena)

- esan dotzut txarto daona
  (esan dizut txarto dagoena)

Baiezko esaldiotan -ENA horren ordez SELAN...-EN ager dakiguke ere, adibidez:

- badakit selan astelena dan
  (badakit zelan astelehena den)

- ementxe ikusten da selan jente asko dabilen
  (hementxe ikusten da zelan jende asko dabilen)

- iger dotzut selan emeko saren
  (igarri dizut zelan hemengoa zaren)

- konturetu nas selan or daon
  (konturatu naiz zelan hor dagoen).





- ulertu dotzut selan bier satosen
  (ulertu dizut zelan bihar zatozen)

*B- Ezezkoetan:*

- esta egi akaba deuena
  (ez da egia amaitu dutena)

- esta egi etorri dana
  (ez da egia etorri dena)

- estao klaru etor direna
  (ez dago argi etorri direna)

Ezezkoetan ere -ENA horren ordez SELAN...-EN sarritan ager dakiguke, adibidez:

- enas konturetu selan emen daon
  (ez naiz konturatu zelan hemen dagoen)

- enas entera selan akaba deuden
  (ez naiz enteratu zelan amaitu duten)

- estotzut ierri selan emeko esaren
  (ez dizut igarri zelan hemengoa ez zaren)

- etxat akorda etzen selan daon
  (ez zait gogoratu etxean zelan dagoen)

*C- Baiezko galderak:*

- badakisu etor direna, esta?
  (badakizu etorri direna, ezta?)

- badakie akaba dune?
  (badakite amaitu duguna?)

- konturetu sara esta txarto daona?
  (konturatu zara ezta txarto dagoena?)

- entzun dosu etor diena?
  (entzun duzu etorri direna?)

D- Ezezko galderak:

- estotzut esan txarto daona, ala?
  (ez dizut esan txarto dagoena, ala?)
- emen estakisu estana iten?
  (hemen ez dakizu ez dena egiten?)
- estakisu ondino akaba dune, ala?
  (ez dakizu ondino amaitu duguna, ala?)
- estakisu etor diena, ala?
  (ez dakizu etorri direna, ala?)
- estakisu yon diresena?
  (ez dakizu joan direna?)
- estostesu igerri ondinokarren emeko nasena, ala?
  (ez didazu igarri ondinokarren hemengoa naizena, ala?)

Erabilera alorrean bakoitzaren hedadura ikusteko hiru aldagai bereiztu beharko genuke; alde batetik, egitura moeta, hots, baiezkoa, ezezkoa, baiezko galdera eta ezezko galdera; beste alde batetik, galdegaia menpeko perpausa izatea (GMP) edo gainerako edozein kategoria (GX), dela lexikala dela ez lexikala; azkenik menpeko perpausa erreferentziaduna den edo ez, hots, diskurtsoaren barruan lehenik sartuta egon den ala ez (E).

Aldagai horiek kontutan hartuta perpaus hauen erabilera ondoko taula honetan ematen dugu laburki:

| | B | | E | | BG | | EG | |
|---|---|---|---|---|---|---|---|---|
| Galde. | +E | -E | +E | -E | +E | -E | +E | -E |
| GX | -ENA | | -ENA | -ENIK | ENA | | -ENA | |
| GMP | | -ELA | | -ELA | | -ELA | | -ELA |





-ENA horren ordez SELAN...-EN ere erabiltzen da.

## ZEHAR GALDERAK

Zehar galderetan moeta bi bereiztu beharko genuke; alde batetik, NZ berbak agertzen direnekoak eta bestetik B/Z galdera denean menpeko perpausa.

**NZ-dunak:**

- es dait nor etorri dan
  (ez dakit nor etorri den)
- es dait nongo dan
  (ez dakit nongoa den)

Batzutan menpekoa jokatu gabea ere izan daiteke, adibidez:

- estekosu setan yon
  (ez daukazu zertan joan)
- estekosu setan esanik
  (ez daukazu zertan esanik)
- bakit nondi sartu
  (badakit nondik sartu)
- badakit ser esan
  (badakit zer esan)

**B/E galderak:**

*Ezezkoetan:*

- es dait etorri bada
  (ez dakit etorri den)

es dait ekarri badeu
(ez dakit ekarri duen)

- esteu esan ekarko badeu
(ez du esan ekarriko duen)

*Aginteretan:*
- esayosu ia giao yan gure badeue
(esaiozu ia gehiago gura duten)

- esayosu ia bier badator
(esaiozu ia bihar datorren)

*Galderetan:*
- esan deu akaba badeue?
(esan du amaitu duten?)

- bier badatos entzun dosu?
(bihar datozen entzun duzu?)

- afari yan badeu ikus dosu?
(afari jan duen ikusi duzu?)

**-A**

- damutute nau belu etorrie
(damututa nago belu etorria)

- damutu dat dana yan esa
(damutu zait dena jan eza)

- selao lastime lenao etorri esa
(zelako pena lehenago etorri eza)

Aditz partizipioa atributo gisa ere ager dakiguke, adibidez:

- ori Bilboti ekarri da
(hori Bilbotik ekarria da)





- ori Donostin erosi da
(hori Donostian erosia da)

- ori emen yayo da
(hori hemen jaioa da)

- kanpoti etorri da
(kanpotik etorria da)

Aditz partizipioa genitibo markarekin batera ere ager dakiguke "-EN PORASUS" egituran, adibidez:

- bear inen porasus seoser ingo deue
(behar eginaren poderioz zerozer egingo dute)

**SE... -ELA**

Egitura hau azalpenetan erabiltzen da eta baita lehenik esanekoa berriro kontatzean ere; adibidez:

- esaten due se asko obe urtetan deule kafek
(esaten dute ze askoz hobea urtetan duela kafeak)

- pentzaten deude se estakidule
(pentsatzen dute ze ez dakigula)

- pentzaten dot se etor dala
(pentsatzen dut ze etorri dela)

- pentzaten deude se inusentek garela
(pentsatzen dute ze leloak garela)

- batzuk esaten deude emen se Leyoako erri estala ume askoko erri
(batzuk esaten dute hemen ze Leioako herria ez dela ume askoko herria)

- dinoude se Leyoako errin estala ume asko

(dinote ze Leioako herrian ez dela ume asko)

- esan dotzo se erdin daola
  (esan dio ze erdian dagoela)
- esaten dotzete se "isu geldirotxu"
  (esaten diet ze "egizu geldirotxu")
- esan neuntzen se "seňe aiteri euskere in ber dako"
  (esan nion ze "seina aitari euskeraz egin behar zaio")

**-ELAKO + EDUKI**

- fasile estalako dekot nik
  (erraza ez delakoa daukat nik)
- etor dokelako yekot
  (etorri delakoa diaukaat)
- emen giao usa dalako dekot nik
  (hemen gehiago erabili delakoa daukat nik)
- orrek emen ingerun biek enplea direlako dekot
  (horiek hemen inguruan biak erabili direlakoa daukat)
- ure iminten dalako dekot
  (ura ipintzen delakoa daukat)
- bein il duleko dekot
  (behin hil dugulakoa daukat)
- orti yon dalako dekot
  (hortik joan delakoa daukat)
- ori esetuten dotelako dekot
  (hori ezagutzen dudalakoa daukat)
- seoser falta dakolako dekot
  (zerozer falta zaiolakoa daukat)





# 11. ERLATIBOZKOAK

**Jokatua:**

-EN

**Ez jokatua:**

-KO

## 11.1. JOKATUA:

Perpaus jokatuetan menpeko perpausa "-EN" atzizkiaren bidez txertatzen dugu nagusian; perpaus txertatu hori izenaren aurre aurrean ager dakiguke, adibidez:

- etor dan gisona emeko da
  (etorri den gizona hemengoa da)

Edo aposizio gisa beste lekuren batetan deklinabidearen kasu marka txertatzaileari deutsela, adibidez:

- Miren sure amas berba iyena Bermeoko da
  (Miren zure amarekin berba egin zuena Bermeokoa da)

Gauza jakina da erlatibozko perpaus jokatuotan arazo nagusiena menpeko perpausaren zein kasu atera daitekeen eta zein ez jakitean datzana; bestalde, aterako kasu marka zelan identifika daitekeen beste arazo bat dugu. Guk bilduko perpausak emakeran menpeko perpausan ezabatu den kasu markaren arabera emango ditugu.

NOR

- Gerniken bisi dana gaisorik dao
  (Gernikan bizi dena gaisorik dago)

- nik ondo deretxet orrek esan deunari
  (nik ondo deritzot horrek esan duenari)

- listo dabilenak ulertuko deu dana
  (zuhur dabilenak ulertuko du dena)

- espate da aurren darona
  (ezpata da aurrean daroana)

- erosi osun libru da motza
  (erosi duzun liburua da motza)

NORK

- estot esetan sues berba in deune
  (ez dut ezagutzen zurekin berba egin duena)

- giltze dekona es da etorri
  (giltza daukana ez da etorri)

NORI

- emon dotzet diru suk emon dotzesuneri
  (eman diot dirua zuk eman diozunari)

- esetan dot esne gustaten yakon neske
  (ezagutzen dut esnea gustatzen zaion neska)

- ogi saldu dotzesun gisonas egon gare
  (ogia saldu diozun gizonarekin egon gara)

- libru ekar dotzen neske esta etorri
  (liburua ekar dion neska ez da etorri)





- au erosi dotzeten gisona makal dao
  (hau erosi diodan gizona makal dago)

NOREKIN

- neu etor nasen neske gaisorik dao
  (neu etorri naizen neska gaisorik dago)

- emen estao berba in dosun gisona
  (hemen ez dago berba egin duzun gizona)

- berba in dosun neske estot esetan
  (berba egin duzun neska ez dut ezagutzen)

- on nasen neske Gernikeko da
  (egon naizen neska Gernikakoa da)

- estot esetan ori enbre etor sarena
  (ez dut ezagutzen andre hori etorri zarena)

- ori gisona berbas egon sarena makal dabil
  (gizon hori berbaz egon zarena makal dabil)

- au etor da ni eon nasen umeas
  (hau etorri da ni egon naizen umearekin)

NORENTZAT

- beskari ekar dosun andrentzako au ekar dot
  (bazkaria ekarri duzun andrearentzat hau ekarri dut)

NOGATIK

- pregunta deuen ume estao
  (itaundu duten umea ez dago)

NOGANA

- yon garen gisona kanpoko da
  (joan garen gizona kanpokoa da)

- yon garen gisona esta emeko
  (joan garen gizona ez da hemengoa)

NON

- beskatan egon garen maya apurtute dao
  (bazkaltzen egon garen mahaia apurtuta dago)

- a taberne isi deude a edan gendune
  (taberna hura itxi dute hura edan genuena)

- yarri saren silla apurtute dekosu
  (jezarri zaren aulkia apurtuta daukazu)

- neu naon lekuko yarleku apurtu da
  (neu nagoen lekuko jezarlekua apurtu da)

- orrek datos geu gosen eon garen lekuti
  (horiek datoz geu goizean egon garen lekutik)

- koyu deude itxi dun lekuti
  (hartu dute utzi dugun lekutik)

- lengo egunen egon gintzen etze saldu in deude
  (lehenengo egunean egon ginen etxea saldu egin dute)

- orrek yon dire gu eon garen lekure
  (horiek joan dira gu egon garen lekura)

- yan dosuen tabernara gero yongo gare
  (jan duzuen tabernara gero joango gara)

- elise daon leku gusta yat
  (eliza dagoen lekua gustatu zait)

- kendu in deue taberne alteas eon gintzena
  (kendu egin dute taberna aitarekin egon ginena)





- etor dires lengon egon gintzen etzekok
  (etorri dira lehenengoan egon ginen etxekoak)

- yon gare aititen etze daon lekure
  (joan gara aitltaren etxea dagoen lekura)

- orrek yon dire gu eon garen solora
  (horiek joan dira gu egon garen solora)

- ni egon nasen etzera yon dires orrek
  (ni egon naizen etxera joan dira horiek)

NONDIK

- etor saren etze saldu in deude
  (etorri zaren etxea saldu egin dute)

- esetu in ber dosue ni etor nasen baso
  (ezagutu behar duzue ni etorri naizen basoa)

- orrek etor diren etzen eon gare
  (horiek etorri diren etxean egon gara)

NORA

- gu yon garen basoti datos
  (gu joan garen basotik datoz)

- suok yon saren etze saldu gure deude
  (zuek joan zareten etxea saldu gura dute)

- gu yon gintzen basoti datos
  (gu joan ginen basotik datoz)

NORAINO

- eldu dire geu eldu garen etzeraño
  (heldu dira geu heldu garen etxeraino)

## 11.2. EZ JOKATUAK

- emen yayoko da ori
  (hemen jaiokoa da hori)

- kanpoti etorriko da ori
  (kanpotik etorrikoa da hori)

- Bilbon yayoko sara?
  (Bilbon jaiokoa zara?)

- au kanpon erosiko da
  (hau kanpoan erosikoa da)

- au amak ineko da
  (hau amak eginekoa da)

- amak esaneko ekar dot
  (amak esanekoa ekarri dut)





# 12. DENBORAZKOAK

| JOKATUAK | EZ JOKATUAK |
|---|---|
| -NEN | -KERAN |
| -EN ARTEN | - ES BESTERIK ETA... |
| -ENERAKO | -AS BATERA |
| -ENIK ONA | - TA GERO |
| -EN BAKOTXEN | - BAÑO LELAO |
| -EN DUSTIN | - ORDUREKO |
| | - ARTEN |

## 12.1. JOKATUAK

-NEN

*Lehen aldia:*

- an egon gintzenen etor san ori
  (han egon ginenean etorri zen hori)

- bason eon garenen agertu da
  (basoan egon garenean agertu da)

- euri iten asi sanen kanpon eon nitzen
  (euria egiten hasi zenean kanpoan egon nintzen)

*Gero aldia:*

- datorrenen eongo nas beragas
  (datorrenean egongo naiz berarekin)

- akabaten dunen yongo gare etzera
  (amaitzen dugunean joango gara etxera)

- erosten dosunen erakutzikostesu
  (erosten duzunean erakutsiko didazu)

- aite datorrenen gu bearren gaos
  (aita datorrenean gu beharrean gagoz)

-EN ARTEN

- ni emen bisi nasen arten suk euskere ingo dosu
  (ni hemen bizi naizen artean zuk euskeraz egingo duzu)

- surok ori akabaten dosuen arten gu etzera yongo gare
  (zuek hori amaitzen dozuen artean gu etxera joango gara)

- surok ori iten dosuen arten nik beskari preparako dot
  (zuek hori egiten duzuen artean nik bazkaria prestatuko dut)

-ENERAKO

- datosenerako akabata eongo da
  (datozenerako amaituta egongo da)

- akabaten dosunerako etorriko da
  (amaitzen duzunerako etorriko da)

- datorrenerako akabata eongo da
  (datorrenerako amaituta egongo da)

- entzun dotenerako esetu dot
  (entzun dudanerako ezagutu dut)

- gu yon gintzesenerako yon siren
  (gu joan ginenerako joan ziren)





- eurek datosenerako gu bearlekun gaos
  (eurek datozenerako gu beharlekuan gagoz)

Udondon "-ENERAKO" barik "-ENEKO" erabiltzen da, adibidez:

- ori datorreneko bearrak inte dekus
  (hori datorreneko beharrak eginda dauzkagu)

- akaba doteneko belu isen da
  (amaitu dudaneko belu izan da)

- etor daneko belu isen da
  (etorri deneko belu izan da)

-ENIK ONA

- etor danik ona estot ikusi
  (etorri denik hona ez dut ikusi)

- ori ekar deunik ona esta etorri
  (hori ekarri duenik hona ez da etorri)

-EN BAKOTXEN

- datorren bakotxen afaltan lotzen da
  (datorren bakoitzean afaltzen lotzen da)

- berba iten deun bakotxen esaten ditus inusentekerik
  (berba egiten duen bakoitzean esaten ditu lelokeriak)

-EN DUSTIN

- kafe iten dosun dustin sartu gantxo
  (kafea egiten duzun guztian sartu gantxoa)

- berbas asten dan dustin inusentekerik esaten ditus
  (berbaz hasten den guztian lelokeriak esaten ditu)

- datorren dustin seoser dakar
  (datorren guztian zerozer dakar)

## 12.2. EZ JOKATUAK

### -KERAN

- urtekeran ate isi
  (urtekeran atea itxi)

- isikeran giltze apurtu da
  (itxikeran giltza apurtu da)

- etorrikeran ikusi in saitues
  (etorkeran ikusi egin zaitut)

- sue bistukeran erre in nas
  (sua biztukeran erre egin naiz)

- akabakeran apurtu in da
  (amaikeran apurtu egin da)

### EZ BESTERIK ETA....

- es besterik eta akaba apurtu in da
  (ez besterik eta amaitu apurtu egin da)

- es besterik eta allega ta oira yon san
  (ez besterik eta allega eta ohera joan zen)

### -AS BATERA

- akabaas batera apurtu in da
  (amaituaz batera apurtu egin da)

- etorries batera oira yon da
  (etorriaz batera ohera joan da)





### TA GERO

- beskari yan ta gero etzera yongo gare
  (bazkaria joan eta gero etxera joango gara)

- bear in te gero yangou
  (behar egin eta gero jango dugu)

- bason ibili te gero yon gintzesen afaltan
  (basoan ibili eta gero joan ginen afaltzera)

- afari yan ta gero yon gintzesen kanpora
  (afaria jan eta gero joan ginen kanpora)

### BAÑO LELAO

- isetu baño lelao bentane isi
  (izetu baino lehenago leihoa itzi)

- beskaldu baño lelao eskuk garbitu isus
  (bazkaldu baino lehenago eskuak garbitu itzazu)

- tomate eldu in baño lelao kiskeldu
  (tomatea heldu egin baino lehenago kriskaldu)

### ODUREKO

- etorri ordureko akabata dao
  (etorri ordurako amaituta dago)

- ekarri ordureko itxiten deitu
  (ekarri ordurako uzten ditu)

- txakurrek ausi iten deu sarata bat entzun ordureko
  (txakurrak zaunka egiten du zarata bat entzun ordurako)

**ARTEN**

- etorri arten eongo gare emen
  (etorri artean egongo gara hemen)

- itxeron ingo datzu arik eta akaba arten
  (itxaron egingo dizugu harik eta amaitu artean)

- nik estot ikusko il arten
  (nik ez dut ikusiko hil artean)

- nik erdere eneun yakin Franco etorri arten
  (nik erdera ez nuen jakin Franco etorri artean)





# 13. MODALAK

| Jokatuak | Ez jokatuak |
|---|---|
| -EN MODUN | -REN MODUN |
| -EN GAÑON | - 0 LAO |
| -ENAITIK | -REN ANTZEKO |
| -ENA LAO | - ALEN |
| -EN MODUKO | -TEKON |
| - SEGUN... -EN | -TA |
| -ELA | |

## 13.1. JOKATUAK

**-EN MODUN**

- ein du suk esan dosun modun
  (egin dugu zuk esan duzun moduan)

- beskari prepara du amak agindu deun modun
  (bazkaria prestatu dugu amak esan duen moduan)

- irebasiten deun modun gasta iten deu
  (irabazten duen moduan gastatu egiten du)

- suk esan dosun modun in dot ori bearra
  (zuk esan duzun moduan egin dut behar hori)

**-EN GAÑON**

- iten deituen gañon saltzen deitu
  (egiten dituen gainoan saltzen ditu)

- irebasiten deun gañon gastaten deu
  (irabazten duen gainoan gastatzen du)

- ekarten deun gañon or itxiten deu
  (ekartzen duen gainoan hor uzten du)

**-ENAITIK**

- esan deunaitik gero etorko da
  (esan duenez gero etorriko da)

- ikus dunaitik pentza lei salduko deule etze
  (ikusi dugunez pentsa liteke salduko duela etxea)

**-ENA LAO**

- yake bat ekar dot aitek dekona lao
  (jaka bat ekarri dut aitak daukana lakoa)

- nik ekarri in dot suk dekosune lao
  (nik ekarri egin dut zuk daukazuna lakoa)

**-EN MODUKO**

- gastai bet erosi dot seuk ikusi sendun moduko
  (gazta bat erosi dut zeuk ikusi zenuen modukoa)

**SEGUN... -EN**

- segun dinon bier etorko da
  (dinoenez bihar etorriko da)

- segun dinen etze salduko deue
  (dinotenez etxea salduko dute)

**-ELA**

- afaltan gaosela argi kendu deue
  (afaltzen gagozela argia kendu dute)





- basoti gatosela ikus du
  (basotik gatozela ikusi dugu)

- yaten gaosela makal para da
  (jaten gagozela makal paratu da)

- emeti berantza gosela dao ori
  (hemendik beherantza goazela dago hori)

- burun karge dotela yoten nitzen
  (buruan zama dudala joaten nintzen)

- bason gabiltzesela agertu san
  (basoan genbiltzala agertu zen)

- etzeti urtetan deule txakurrek ausigi deutzo
  (etxetik urteten duela txakurrak haginka egin dio)

## 13.2. EZ JOKATUAK

**-REN MODUN**

- in dot bearra seure modun
  (egin dut beharra zeure moduan)

- au in dot orren modun
  (hau egin dut horren moduan)

**0 + LAO**

- ni nas su lao
  (ni naiz zu lakoa)

- ori da aite lao
  (hori da aita lakoa)

- surok asko dakisue eta gu lao estao preparata
  (zuek asko dakizue eta gu lakoa ez dago prestatuta)

- gu laontzako esta esebe
  (gu lakoentzat ez da ezer ere)

**-REN ANTZEKO**

- ori da sure antzeko
  (hori da zure antzekoa)

- au da aisten antzeko
  (hau da ahizparen antzekoa)

**ALEN**

- koyu alen yan iten ditu
  (hartu ahala jan egiten ditu)

- etorri alen yarri iten dires
  (etorri ahala jezarri egiten dira)

**-TEKON**

- egurrek ekartekon yon nok baye etxoas ekarri
  (egurrak ekartzekoan joan nauk baina ez ditiat ekarri)

Honen ordez "-TEKO IDEAN" erabiltzen da, adibidez:

- yon nas dendara alkondara bat erosteko idean
  (joan naiz dendara alkondara bat erosteko asmotan)

- etor dire gues berba iteko idean
  (etorri dira gurekin berba egiteko asmotan)

**-TA**

- ori dao esanta
  (hori dago esanda)





- ori dao ausite
  (hori dago hautsita)

- badekot ori entzunte
  (badaukat hori entzunda)

- olan seoser badekot ulertute
  (holan zerozer badaukat ulertuta)

- suk euskere dakisun modun yakinte selan sure umek estaki
  (zuk euskara dakizun moduan jakinda zelan zure umeak ez daki)

# 14. GONBARATIBOAK

Gonbaratiboak ikusteko bereizketa txiki bat egin behar dugu; alde batetik, moduzkoak ikusiko ditugu eta, beste aldetik, kantitatezkoak; bestalde, bereizketa honen barruan gonbaratiboa berdintasuna edo desberdintasuna adierazteko den bereiztu beharrean gagoz.

## 14.1. MODUZKO GONBARATIBOAK

- EN GAÑO
- REN GAÑO
- BAÑO...-AGO
- GERORAO ETA... -AGO
- SENBET... -AGO
- ASKOS...-AGO
- AL DENIK ETA...-EN

### 14.1.1. Berdintasuna.

**-EN GAÑO**

- suk ikusi sendun gaño andi da ori
  (zuk ikusi zenuen gaino handia da hori)

- nik ekarri nendun gaño txikerra da ori
  (nik ekarri nuen gaino txikia da hori)

**-REN GAÑO**

- su sara nire gaño gaste
  (zu zara nire gaino gaztea)

- su sara orren gaño andi
  (zu zara horren gainoi handia)

- ori andre nire amaren gaño andi da
  (andre hori nire amaren gaino handia da)

- ori da sure gaño ona
  (hori da zurea gaino ona)

Hona hemen era honen aldaera den 0 + BAÑO, Leioan bertan biak erabiltzen dira:

- su sara ni baño gaste
  (zu zara ni baino gaztea)

- ori da ama baño andi
  (hori da ama baino handia)

- su sara ori baño andi
  (zu zara hori baino handia)

- ori da sure baño ona
  (hori da zurea baino ona)

## 14.1.2. Desberdintasuna.

**BAÑO... -AGO**

- ni nas su baño gasteao
  (ni naiz zu baino gazteagoa)





- ori da su baño sarrao
  (hori da zu baino zaharragoa)

- ori obe da beste baño
  (hori hobea da bestea baino)

- ori txarrao da beste baño
  (hori txarragoa da bestea baino)

- ni nao su baño obeto
  (ni nago zu baino hobeto)

- su ori baño txarrao saos
  (zu hori baino txarrago zagoz)

- nik bere dakiten baño obeto yakin dot euskere
  (nik ere dakidan baino hobeto jakin dut euskara)

- eurek sartuten dotzue gause andi ona merkeao bertako baño
  (eurek sartzen dizute gauza handik hona merkeago bertakoa baino)

- orti baño obeto sos emeti
  (hortik baino hobeto zoaz hemendik)

- orti yon sos obeto emeti baño
  (hortik joan zoaz hobeto hemendik baino)

## 14.1.3. BESTE BATZUK

**GERORAO ETA... -AGO**

- gerorao txikerrao obeto
  (geroago txikiagoa hobeto)

- gerorao andiao txarrao
  (geroago handiagoa txarrago)

**SENBET... -AGO**

- senbet parajeao obeto
  (zenbat hurbilago hobeto)

- senbet gogorrao txarrao
  (zenbat gogorragoa txarrago)

**ASKOS...-AGO**

- ori askos da fasilao
  (hori askoz da errazagoa)

- ori da askos gatxao
  (hori da askoz zailagoa)

**AL DANIK ETA... -EN**

- yon ber da al danik arinen
  (joan behar da ahal denik arinen)

- erosi ber da al danik eta andien
  (erosi behar da ahal denik eta handien)

- etorko nas al danik eta arinen
  (etorriko naiz ahal denik eta arinen)

## 14.2. KANTITATEZKO GONBARATIBOAK

- EN BESTE
- K BESTE
- BAÑO GEYAO/GITXIAO
- GERORAO ETA GEYAO/GITXIAO
- ASKOS BERE GEYAO/GITXIAO





### 14.2.1. Berdintasuna

**-EN BESTE**

- amak esan deun beste ekar du
  (amak esan duen beste ekarri dugu)

- suk esan dosun beste ekar du
  (zuk esan duzun beste ekarri dugu)

**-K BESTE**

- suk dekosu nik beste diru
  (zuk daukazu nik beste diru)

- onek yan deu anajek beste
  (honek jan du anaiak beste)

- ekar deude suk beste sagar
  (ekarri dute zuk beste sagar)

- edaten dosu nik beste
  (edaten duzu nik beste)

### 14.2.2. Desberdintasuna

**BAÑO GEYAO/GITXIAO**

- suk ekar dosu nik baño geyao
  (zuk ekarri duzu nik baino gehiago)

- orrek erosi deu guk baño gitxiao
  (horrek erosi du guk baino gutxiago)

- nik pentzetan dot txarrerako geyao oberako baño
  (nik pentsatzen dut txarrerako gehiago hoberako baino)

- ori baño glao ulertan deu orrek
  (hori baino gehiago ulertzen du horrek)

**GERORAO ETA GEYAO/GITXIAO**

- gerorao eta geyao ekarri obeto
  (geroago eta gehiago ekarri hobeto)

- gerorao eta gitxiao egon obeto
  (geroago eta gutxiago egon hobeto)

Hona hemen beste aldaera txiki bat:

- gerorau te gause glao daos
  (gerorago eta gauza gehiago dagoz)

- gerorau te ume gitxiao daos
  (gerorago eta ume gutxiago dagoz)

**ASKOS BERE GEYAO/GITXIAO**

- ekar deue askos bere geyao
  (ekarri dute askoz ere gehiago)

- eros deue askos bere gitxiao
  (erosi dute askoz ere gutxiago)





# 15. KAUSALAK

- ELAKON
- LES
- SE
- ETA

**-ELAKON**

- nator belu galdu dotelakon trena
  (nator belu galdu dudalako trena)

- ori estator belu dalakon
  (hori ez dator belu delako)

- gaur astelena dalakon bearren yon gare
  (gaur astelehena delako beharrean joan gara)

- parkatu berandu etorri naselakon
  (barkatu berandu etorri naizelako)

- orrek esetan neu bear batera iten dulakon
  (horrek ezagutzen nau behar batera egiten dugulako)

**-LES**

- orrek kanpoko dales es daki euskere
  (horrek kanpokoa den lez ez daki euskara)

- gisona ain ona isen sales serure yongo san
  (gizona hain ona izan zan lez zurura joango zen)

- emen gaoseles ikusten gos
  (hemen gagozen lez ikustera goaz)

**SE**

- bano se belu da
  (banoa ze belu da)

- bano se trenak ensegida urtengo deu
  (banoa ze trenak behingoan urtengo du)

- bentana isi ber da se otza iten deu
  (leihoa itxi behar da ze hotza egiten du)

- eron guardasola se pentza lei euri ingo deule
  (eroan guardasola ze pentsa liteke euria egingo duela)

- bier akabakot se oin estekot denporarik
  (bihar amaituko dut ze orain ez daukat astirik)

- sos etzera se an topako su
  (zoaz etxera ze han topatuko duzu)

- au emen imin ber dot se esparabere estekot lekurik
  (hau hemen ipini behar dut ze ezpabere ez daukat lekurik)

**ETA**

- aitu isu bataren bat etzen sartu da ta
  (begiratu ezazu baten bat etxean sartu da eta)

- isi isu bentane otza dao ta
  (itx ezazu leihoa hotza dago eta)





# 16. BALDINTZAK

- ESKERONEN
- TEKOTAN
- ESIK/ESEN
- ESPABERE

Atal honetan baldintza ez jokatuez ihardungo dugu, izan ere, aditzari dagozkionak aditzari opetsiko atalean ikusi ditugu.

**ESKERONEN**

- Bilbon koyu eskeronen ori trena obeto
  (Bilbon hartuz gero tren hori hobeto)

- asi eskeronen seoser ingo genko
  (hasiz gero zerozer egingo genuke)

- denpora ona in eskeronen yongo nentike basora
  (eguraldi ona eginez gero joango nintzateke basora)

- yakin eskeronen bardin deust
  (jakinez gero bardin dit)

- geldiro in eskeronen berba ulertan da danana
  (geldiro eginez gero berba ulertzen da denena)

- kalera yon eskeronen da giao erdere
  (kalera joanez gero da gehiago erdera)

- urte batzuk auki eskeronen eurok ikusko deue
  (urte batzuk edukiz gero eurok ikusiko dute)

- denpora ona ineskeronen basora yon letike
  (eguraldi ona eginez gero basora joan liteke)

**-TEKOTAN**

- txarto itekotan oba itxi
  (txarto egitekotan hobe utzi)

- bier yotekotan dusti batu ber da
  (bihar joatekotan guztia batu behar da)

- bier yotekotan dana itxi ber da akabata
  (bihar joatekotan dena utzi behar da amaituta)

- berba txarto itekotan oba da isilik eon
  (berba txarto egitekotan hobe da isilik egon)

**ESIK/ESEN**

- ondo ikusi esik buruko mine emoten deu
  (ondo ikusi ezik buruko mina ematen du)

- allega esen es gengi ikusi
  (allega ezean ez genezake ikus)

- es gentike yon kotxerik auki esen
  (ez gintezke joan kotxerik eduki ezean)

**ESPABERE**

- dana yan ber dosu espabere txiker lotuko sara
  (dena jan behar duzu ezpabere txiki lotuko zara)

- denpora ona in ber deu espabere etzen lotuko gare
  (eguraldi ona egin behar du ezpabere etxean lotuko gara)

- isik ori ate espabere otzitu ingo nok
  (itx ezak ate hori ezpabere hoztu egingo nauk)





Honek badu aldaera txiki bat ere, hona hemen:

- etzen eongo da esparabere taberan
  (etxean egongo da ezpabere taberan)

- kotxen yon ber du esparabere berandu elduko gare
  (kotxez joan behar dugu ezpabere berandu helduko gara)

- ondo in ber da esparabere bapes
  (ondo egin behar da ezpabere bat ere ez)

# 17. KONTZESIBOAK

- ARREN
- AUNKE... -EN
- AUNKE... 0
- BA-... BERE
- AITIK
- TA BERE
- ELA BERE
- BARIK

## ARREN

- ondo on es arren balio deu
  (ondo egon ez arren balio du)

- ori ekarri arren estu eser iten
  (hori ekarri arren ez dugu ezer egiten)

- erriko isen arren estot esetan
  (herrikoa izan arren ez dut ezagutzen)

- ori esan arren eser estu konpontan
  (hori esan arren ezêr ez dugu konpontzen)

- kotxen yon arren eskentikes elduko
  (kotxez joan arren ez ginateke helduko)

- orrek kanpoko isen arren euskere ikis deu
  (horrek kanpokoa izan arren euskara ikasi du)

**AUNKE...-EN**

- danak afari yango deue aunke asko etor diren
  (denak afaria jango dute asko etorri diren arren)

- aunke etorri estan esteu inporta
  (etorri ez den arren ez du inporta)

- aunke denpora txarra daon basora yongo gare
  (eguraldi txarra dagoen arren basora joango gara)

**AUNKE (Aditza jokatu barik)**

- aunke asko etorri danak afalduko deue
  (asko etorri arren denek afalduko dute)

- berandu isengo letike aunke amarretan akaba
  (berandu izango litzateke hamarretan amaitu arren)

**BA-... BERE**

- amarretan etorko basentikes bere berandu isengo letike
  (hamarretan etorriko bazina ere berandu izango litzateke)

- arin basatos bere ya estosu ikusko
  (arin bazatoz ere ja ez duzu ikusiko)

**-AITIK**

- etxekok lebarik etorri esaitik
  (ez diaukak lebarik etorri ezagatik)

- ogi eronaitik ardau bere eron genki
  (ogia eroanagatik ardoa ere eroan genezake)

- basora yongo gare denpora txarra ineitik
  (basora joango gara eguraldi txarra eginagatik)





Era honen aldaera dugu "-ARRIK", adibidez:

- denpora txarra inarrik basora yongo gare
  (eguraldi txarra eginagatik basora joango gara)

**-TA BERE**

- erriko isenta bere estot esetan
  (herrikoa izanda ere ez dut ezagutzen)

- eneskio emongo belauniko paraute bere
  ( ez nioke emango belauniko paratuta ere)

**-ELA BERE**

- gure esteule bere in deu
  (gura ez duela ere egin du)

**BARIK**

- eskatu barik emon doskue
  (eskatu barik eman digute)

- ikus barik esetu dot
  (ikisu barik ezagutu dut)

# 18. KONTSEKUTIBOAK

- AIN
- ATAÑOKO
- ALANDASE

**AIN...**

- ori da ain andi esta kabiten ateti
  (hori da hain handia ez da sartzen atetik)
- dao ain lodi gaisorik para letike
  (dago hain lodi gaisorik para liteke)
- ainbeste jente dau emen esin da ibili bere
  (hainbeste jende dago hemen ezin da ibili ere)
- ainbeste yan deu esebe esteu itxi
  (hainbeste jan du ezer ere ez du utzi)

**ATAÑOKO**

- iten deu atañoko bero ta arnasarik elei artu
  (egiten du halako beroa eta arnasarik ez liteke har)
- atañoko otza iten deules manta bat koyu ber isen du
  (halako hotza egiten duenez manta bat hartu behar izan dugu)

**ALANDASE**

- alandase bakisu ser in ber dosun
  (halanda ze badakizu zer egin behar duzun)
- alandase esin du eser in
  (halanda ze ezin dugu ezer egin)

# ERANSKINA

Lan honen helburua bertako folklorea lantzea ez den arren interesgarri eritzi diogu hemen bertan jasoko kanta batzu eta narrazio ttikiak sartzeari eranskin gisa. Hemen agertzen direnak Alicia Elordui-ri jaso genizkion; baliteke hurrengo lan bati begira askozaz ere gauza gehiago aurkitu ahal izatea.

KANTAK.

1.

din dan nor il da
Peru sapatarie
ser in deu pekatu
daroidela eleisara
txitxi lupeán sakatu

2.

seintxu txikerra
negarres dago
ama emoisu titie
aite ordie taberman eta
ama pikaro yokoan
ostarabere egongo dira
txarri ederrak ausoan

3.

logure nas ta
lo ingo neunke
banenko oirako lagune
oirako lagune baiko baye
agure lepo makurre
agure lepo makurre sutzat
neuretzat gison gordine

4.

obabatxu lo ta lo
seuk orain eta neuk gero
seuk gure dosun orduren baten
biyok eingou lo ta lo

5.

amama koitedea
gortati negarres
katuek eron dotzo
taloa dandarres
aitite muku erretako
pipetxu salea
pipetxuk erre dotzo
musturren puntea

6.

neure lastango lastango
kalea negarres dago
aren negarra obeago da
askoren barrea baño

7.

udebarriko lora ederra
non egon sara neguen
abasusean bildurreagas
lurren barruen sartute

8.

ederrak bi balio
onak iru te lau
ederra iseteak
asko balio deu





9.

txiki txikitxue eta
polit politxue
nori emon dotzesu
neure agindue

Umeekin erabiltzen diren beste zenbait gauza:

10. Narrazioa:

yo nitzen aiteana
emoteko giltze,
aiteak esayesten
emoteko gantze,
txarriaren gantze;
yo nitzen txarriana
emoteko gantze,
txarriak esayesten
emoteko esne,
beyaren esne;
yo nitzen beyeana
emoteko esne;
beyeak esayesten
emoteko bedar,
munearen bedar;
yo nitzen muneana
emoteko bedar,
muneak esayesten
emoteko iriti,
errementarien iriti;
yo nitzen errementariana
emoteko iriti,
errementariak esayesten
emoteko pluma
arrayaren pluma;

yo nitzen arrayeana
emoteko pluma,
arrayak esayesten
emoteko axe,
itxasoan axe;
itxasoak niri axe,
nik arrayari axe,
arrayak niri pluma,
nik errementariri pluma,
errementarik niri iriti,
nik muneari iriti,
muneak niri bedar,
nik beyeri bedar,
beyak niri esne,
nik txarriri esne,
txarrik niri gantze,
nik aiteri gantze,
aitek niri giltze,
nik amari giltze,
eta amak emoyesten ogi.

11. San Juan eguneko esaldia:

"San Juan bagiletakoa
sapok eta subek erretakoa"

12. Haginak jauskeran esaten dena:

"Maritxu talletako
gona gorridune
autzi agintxu sarra
ta ekarsu barrie"





13. Zenbakiak ikasteko:

Zenbaki guztiekin esaten dena ezin jaso izan dugu:

bat, Patxi parrat
bi, Patxi eperdi
iru, kolko bete diru
sei, gorta bete bei
bederatzi, katun narru eratzi
amar, katuk iten deu marmar

Bada, beste zenbaki sistema bat ere:

1 baga
2 biga
3 iruga
4 laga
5 boga
6 sega
7 sapa
8 sotza
9 beatza
10 tronpa

14. Umeekin erabiltzen diren berba batzu:

toto = txakurra
papa = ogia
apatxe in = jezarri
andi andi = joan
txetxa = umea
mama = ura
punbale = jausi
tato = salto egin